# AURKIBIDEA

## FALTA ETA SOBERA

Datozen horririk gehienak
dira segur asko
sobera daudenak
eta gainerakoak faltarik
egiten ez dutenak
Gaitz erdiago da hori
neu sobera egotea baino
eta neu sobera banago
alferrik da guzti hauek
falta egitea
Munduan segur asko
gehienentzat sobera nago
eta gainerakoentzat ez dut
faltarik egiten
baina ustez neure buruari
falta egiten diodaino
gaitz laurden da guztientzat
sobera egotea
eta neure buruarentzat

sobera banago
alferrik da guztiei
Jainkoa barru
falta egitea
Baína nahiz eta guztientzat
sobera egon
noribait bederen
zure itzalari bada ere
faltazkoa banatzaio
ez naiz sobera egongo
neure buruarentzat ere

## HORMA HAUK SARE HAUK

Nik ez diot horma hauk
hezur hirinez eginik daudela
ez langileen larruko
gatzez kareztaturik
Horma hauk
soil soilik, beste gabe
zementuz eginik daude
Guti al deritzazu?

Nik ez diot sare hauk
bizkar urtuz eginik daudela
ez mea-satorren bekokiko
izerdiz bezturik.

Sare hauk
soil soilik, beste gabe
burdinaz eginik daude
Guti al deritazu?

Nik ez diot horma hauk
astunak direnik
neu astundu naizela baino
ez baitadukat lekurik
neure pisua hedatzeko.
Eta honela
horma horik horrela
naizen guztia
soinean eraman behar
gau egunetan zehar.

Nik ez diot sare hauk
krudelak direnik
neu krudeldu naizela baino
ez baitadukat lekurik
neure bihotza hedatzeko.
Eta honela
sare horik horrela
bihotz guztia
golkoan eraman behar
urte luzeetan zehar.

Ez dut eskatzen giza eskubiderik
animalienak baino soil soilik.
Animalia bat naiz
eta ohore handiz
basokoek baino leku gehiago
behar dudana bizitzeko
eta gutiago hiltzeko.

Hegoa-iparren norabidea
muturretan behar dut
arbola bat behar dut
nondik natorren

edo nondik bota ninduten
gogorazteko bederen
Baina horma hauk
zementuz eginik daude
Baina sare hauk
burdinaz eginik daude.

Justizia hitz harroegia da
hemendik eskatzeko.

Haizea behar dut haizea
emaidazue haizea
lehorra nahiz hezea

Baina horma hauk
zementuz eginik daude.

Maitasunik aipatzen ere
lotsa nauzue hemen

Lur puska bat behar dut lur puska bat
emaidazue lur puska bat
kilkir bat gordetzeko lain behintzat

Baina sare hauk
burdinaz eginik daude.

Guzti hau esateko
ez dago zertan
poeta izan
begi bat hertsi baino
eta besteak zer dakusan
esan.

Zeren eta zeren

zementu hauk burdinazkoak baitira

burdinak hauk zementuzkoak baitira

Soil soilik, beste gabe
alegoriak sobera daude.

## ZER DIOK OILAR

Zer diok oilar
zer berri diakarrek
loa bezain kantu
zahar horrek?

Egun berri bat egun berri bat
Ala egun zahar bat gehiago?
Zergatik ez duk jotzen
eguerdiko hamabietan
eta uzten nauk orain
baketan?

Joana duk hire kantua:
"Oilaritez oilaritez
biziak itzar bitez
beude lo hilik balitez"

Gaur satorrak ere erlojutik
hasten dituk lanean

hire jauntzaroa:
oilarrak hirugarrenez jo orduko eta abar
lekutako amaren kontuak dituk
Egia duk ez dela orain arte
eguzkirik jaio hik jo gabe
baina ez dik inork sinesten
horregatik denik
areago oraindik
zerbaiten huskeria
behar denean adierazi
esaten diate:

Horrek ez dik merezi
kukurrukurik ere.

Horregatik oilar
ez nazak iratzar

jo hezak bihar
eguerdiko hamabietan.

— Eta derrigorra bada
entzun beharra
kanta hiezadak lo-zorroan
egia eta gezurra
poza eta tristura
erdibitzeko dauden
umontzi beroan.

Zer diok oilar
zer berri diakarrek
loa bezain kantu
zahar horrek?

Maite berri bat maite berri bat
Ez, mesedez
nekaturik niagok maitatzez
gehiegi maitatu diat
gehiegi eta maiteegi
hi ere bai
goizkari mendetsu hori

Ez hakit mesedez
mintza maitasunez

Zergatik jotzen diek berdin
haurrei eta besteei
edo zergatik jotzen didak
haurretan bezala?
Ez dakika ordutik
urte asko pasa dela
eta harri asko?
Orduan
ohe bete loguraz
gorputz bete ilusioz
saltatzen nian mundura
Orduan
ikusten nuen guztia
hilargia nahiz eguzkia
ukitzen nuen dena
azala nahiz barrena
maitatzeko zela uste nian
baina ez nian uste
uste izaten hasi aurretik
maitatu bainuen
inork igarri gabe

izarrak ohartu gabe
urrundik, hots,
golkoaren ezkutuan.

Horregatik oilar
utz nazak baketan
jo hezak bihar
eguerdiko haitabietan.

Hik ez dezakek konpreni
ez zaik ere komeni
hire maitea
oilategia izaki.
Oilo bat gora behera
zer zaik hiri ardura?
Horixe nahi duk hik
oilar putaner horrek
besteok jaiki arazi
eta herorrek
izorraketan eman eguna
Etorkizun horrekin neu ere
kantari itzarriko nindukek
Nola moldatzen haiz egunean
hainbeste luma apartatzeko
eta gainera eta gainetik
ekilibrioa zaindu?

Mesedez oilar
utz nazak baketan
jo hezak bihar
eguerdiko hamaputetan.

Urte asko harri asko
Hasi nintzen hasi
bizitza goldatzen
zakonago eta mamiago
hura afana
haitza jo arte
gizona jo arte
Xirrio egin zuen goldeak:
Geldi hemen! Heurt!
nor naizela uste duk?
eta endaitzak krask egin zuen
egin nuen
Nik ez nuen uste gizona
hain gogorra zenik
nik uste nuen zapalkuntza eta larruketa
pasadizokoak zirela
egon bazeudela
baina ez hartara
bereziki jarrita.
Aker adar-motz hura
ene umetako laguna.
Topeka egiten genuen noiznahi
zekien jolas bakarra izaki
negarrez ipini ere bai
berak ni, jakina, berak ni
ez baitzekien gaxoak kalkulatzen
Aker adar-motz hura
bihotzez maite nuen
hamaika artaburu gozo
ohosturik han hemen
eramaten nion ezkutuan.
Baina gizona

ez zen hain ona
baina eta gizona
ez zen aker hura
benetan jotzen du
kalkulu guztiekin jo ere
Kostatu zait sinesten
eta sinestera heltzean
orduantxe sinesgaitzen.

Angulak zirelakoan
gustatzen zaizkidanarekin gainera
zer zirela baina?
markesa mutxurdinaren
zizare zuriak
egin berri berriak
Ez duk izango! eta bazirela ez zirela
zizare zuri zuriak
jan nituela sinestera
helduz batera
sabelak glauk saltatu zuen
tripak hormen kontra zihoazen
eta ahotik eta zulo guztietatik
hesteak darizkit
gizona jan baitut
gizona jan ere
giza-ona zelakoan.
Ez dago edozer sinesterik
sabelaren baimen gabe

Horregatik oilar zantar
ez nazak iratzar
egun bat gora behera
gizon bat behera gora
ez duk gaztanbera
bihurtuko polbora.

Hau ez duk hiria
oilategi izugarri bat baino.
Eskailera batzu igon
eta kaiola batera sartu
eta kaiolagintzari
etxagintza deitu zioten.
Hau oilategia duzu
oilartegia
hots, gizategia
baina oilategi honetan
ez da zilegi oilarrik
gizategian gizonik.

Horregatik oilar
hobe zaik isiltzea
hobe ziaidak ez itzartzea
Kukurruku! Erori duk!

Zer diok oilar mokozabal
nor erori duk eta nora
amerikarrak hilargira?

Ez! Hilargia Amerikara
eta hilarri jarri zaie!

Oilar gangar gorri
berri handia duk hori
urrunegi ordea
utz dezadan ohea
Etxe Zuriari diodan
gorroto beltz eta guzti ere
hurbilago behar diat jaikigarria
urrea ez bada harria

Kukurruku! Hasi dituk!
Kukurruku! Ari dituk!

Oilar madarikatu
nortzu ari dituk
eta zertan?
Kale goldaketan!
Zein kale?
Herori hatzana
eta hiri guztia
hi jaiki desgogo haizen
hiri guztia.

Ari dituk dituk ari
bostehun mila goldelari
trafikoa itzarri baino lehen
hirijauna jaiki baino lehen

Oilar asaldari
badira bitez ari
gizon bat gora behera
antzera duk hori.

Kukurruku!
Idi-uztarri gorri bat
semaforopean geldi
ez dakite zer irauli
zeren eta beren
itzaina falta zaien
jaiki hadi jaiki
idiengatik bederen.

Non dira ama oinetakoak
jaiegunetakoak?

eta gainera eta gainera
ohean harrapa bahazate
ahotik darizkian hesteekin
lepora korraizu egin
eta eskegiko haute
Hirizorramaiztegin

Ez dadukat astirik ama!

Eta gainera eta azpira
egunero oilo mordoa galdu behar
ohati mainontzi bategatik

Isil hadi oilar uzkibero
ez duka ikusten banoala
goizero
bezala?

Hildo luze zakona
lurhatsa dariona
han ehorzten gizona
ernetzen giza-ona.

Bai dela sarkor
bai atsegina
lur iraulien
lehen usaina
Sar hezak golde
bortxaz burdina
ager lurraren
sabel urdina.

Zer diok oilar
zer berri dakar
onhartzen dudan
profeta bakar?
Ez lehengo hitzak
arren haintzat har
egidak dei gaur
bezala bihar.

## HIDROGENO AHALGUZTIDUNA

Hasieran hidrogenoa zen
eta hasiera hidrogenoa zen
eta hidrogenoak ez zuen hasierarik
Dena zen hidrogenoa
eta hidrogenoak egin zuen dena
eta hidrogeno gabe ez zen ezer egingo
Berarengan zegoen bizia
eta biziak gizona zekarkeen
eta gizonetik hidrogenoa zihoakeen
Bazen laino harrigarri bat
noiz-nonik gabea
hartaz kanpo ez zegoena
ez denborarik ez lekurik
Laino hura ari zen ari
ez inondik inorantz
barrutik barrurantz baizik
ari ahala bilduz
bildu ahala desbilduz
lehen-azkenik gabeko abiadan

Hidrogenoak umeak egin zituen
eta umeek bir-umeak
baina elementuei ez zaie gustatzen
hidrogenokumeak deitzerik
hain desberdinak izanik
ahazturik baitaude jatorriaz.
Nork jakin ordea
zer den berdina
zer desberdina
materiaren golkoan?
Eta hauk atomoak ziren
eta atomoa hastapena baizik ez omen
eta atomotik atomora
lizarrak bizarretan haina mende egon
eta baina iso!
zertarako mintzatu denbora lekuez
ez baita irudimenik hemen
ez inoiz ez inora heltzen?
Eta materiari izena jarri zioten
eta izpiritua deitu zioten
baina inork ez daki zer den
hartaz eginik egon arren
nahiz eta harengan
gauden eta garen
Izena da guttiena
izana axola zait izana
izana eta izanena
eta ez dezala izenak
estal izanik
Gure adimendua da zulo bat
lurraren golkotik gora
mehe mehea

luze luzea
argi izpi zulatua
zuloa dela juxtuan igartzekoa
Baina iso baina egon
zabalduko du zuloa
mendeen daratuluak
heriotzaren presioak
eta zuloak materia osoa
perfora dezanean
eta materia osoa zulotik
pasa dadinean
izena eta izana
bat bera izanik
hidrogenoak ez du
beharko izenik.

## ATORRAMENDUA IZORRAMENDUAREN

Ezkontzako Izorramendu Saindua
hartzeko dira
        goitik
Izorranio Izorrategi Izorrandiaga
Izorramortun jaio eta
Izorretan bizi dena
        eta behetik
Izorne Izormendi Izorrarteta
Izorramurdin jaio eta
Izorraberton bizi dena
Zerrimendu honen kontra
ezer dadukana
hilargi barruan zertzera
zerturik dago
Apaizak eta fraideak
jende izorratzaileak
Kobla honen asmatzaileak
sinesten zuen bai
horien zerean

Gure keleto meleto
etxean geldi hobeto
Aizak Lukano, zer Kristo egiten duk
horrenbeste ume edukitzeko?
- Herorrek bat edukitzeko egin huena
baina sarriago

Puntu bat heltzen da izorramenduan
izorragaitasunak agortzen direna
eta orduan
kapar bat ikusten da
aker ipurdian
gehiago izorratzeagatik
zuloan barrura doana
eta akerrak galtzen ditu arteak
eta saltatzen haitzarteak
baina kapar izorratzaileak
barrura eta barrura jotzen
Nor deabru ari ziaidak
atzetik ematen?
eta akerrak kraskatzen ditu adarrak
eta garraskatzen uzki bazterrak
haitzik zorrotzenen kontra
baina kapar izorratiak
aurrera eta aurrera
darama zuloa
zein baita unea
mundua ulertzekoa
akerrak akerresari
uzkia erakusten diona
baina eta baina
emea alajaina

akerresa zitalak
usin eta muzin
bakarrik egiten
Honetarako hartu
al nian andrea?
Kapar koinoa galdu da
zuloan barrura
eta aker izorratuari
ez zaio besterik bururatzen
ipurdia haitzetan behera
botatzea baizik
zeinen atzetik baitoa
buztana ere
eta adarrak eta barrabilak
lurrintsuak eta biribilak
hitz batez aker osoa
eta han behean
blast entzutean
zart bukatzen barreak
ez duk gehiago ahuntzik izorratuko
izorramenduak ez baitu atorramendurik
atorrapean egon arren ostendurik
Aizak Lukano, zergatik ez duzue
argiarekin lo egiten?
Akaso ilunarena
izango duk dena
- Haur bat baino gehiago
kostatzen ziaidak argia
antzutuko duk noizbait
gure andre Maria

Izorranio ezkontzean
Izorneren kontra
ibarreko lizarrek
bizarra utzi zuten
Bazen alaba bat
Izorneren hauzoan
Izarne zeritzana
Izorranioz besterik inor
ezin maitatzeko patuz
amak munduratua
aitaren laguntzaz
eta ibarreko lizarrak
hilargiarekin dantzan
ari bitartean
Izarnek negar eta negar
egiten zien izarrei
soineko beltzean
egun bakoitzean
izar gorri bat bordatuz
- Tori otoi soineko eta soin
Baina nola Izorranioren amak
ez baitzuen semea
aitaren laguntza eta guzti ere
Izarneren patukide munduratu
alde paretik!
eta bere bideari segitu zion
Oh Izorranioren patu ankerra
ahuntzaren gainean akerra
zer erru dut baina nik
Izorneren zorionean
Izarneren zoritxarrean?
Aizak Lukano,

antzutu duka ia
zuen andre Maria?
- Ez arraiea!
galtzak janzten ikasi dik
- Oherako ordea...
- Harakoxe hain zuzen
- Baina galtza eta guzti ere
- Bai jantziko ez balitu
atzekoz aurrera!

Bai litzatekeela izorramendu desgilborgarria
jaun batzu izorratzea elefantedun·utzirik
hala nola lehenengo hilean
ez baitu gerrikoa nasaitu beharrik
baina nola elefantekumeak ere
ez baitu jaiotzeko presarik
ez hiltzeko bildurrik
hazten eta hazten darama denbora
eta sabeltzarra handitzean eta handitzean
hamalaugarren ahalegina behar
hortzak ez dakizkidan eror
desbarrabilmenduaren desbilmendubarrez
(berdin zait barre egin hitzekin
nahiz barreekin hitz egin)
zeren bederatzigarren hilean
tronpa bat agertzen baita
jaun madarikatarraren ahoan
- Zer agiri zaik ahotik senartxo?
- Tripako zerbaiten punta emaztetxo
Jaun izorratua itotzear goitik
lehertzear erditik
hamaika izorratu duk alu horrek

baina mundu guztiak daki
ez dagoela izorraziorik
errementazioa bezalakorik
eta jauntzarrak azkenean
tripaz behera lurrean
post egin zuen
kostatuko zaik gehiago izorratzea
eta elefantekumea
Afrikako oihanetara bidali genuen
jaun erdi berriaren
larru zatiekin
biderako abarka
pare bi eginik.
Jaunen andreok!
Zuen golkoetan sartzeko baino
maiteago zaituztet
baina ez du horrek kentzen
des-hezurmendu jeneral bat
senti dezadan
gorputz osoan
tripaundi hoietako bat
elefante-minetan ikustean
zeren zerak zioenez
Aizak Lukano, nola duk
hik esaten huena
gizona kainaberarekin
erratu zuena?
Zeren Paskualek zioenez
kainabera izorratu bat
baita 'gizona
eta gizateria
kainagoradi izorratuago bat

eta honela ez da harritzeko
izorramenduak ez edukitzea atorramendurik
atorrapen egonik ere ostendurik.

Aizak Lukano
nola dakusak mundua?
- Ilun arraioa!
  Illun?
- Nola nahi duk bada
  gaua baita?

Badira gizonak
oker jaioak
badiren bezala
atzeko kanaletik
jaio beharrekoak.

# MUNDUAREN HITZAURREA

## I. Intzaurrondoaren azpitik

Mundua konpontzea bururatu
zitzaidan egunean
hobe mozkor handi bat
harrapatu banu
harrapatu banindu
oraintxe ere ez lukek berandu
Neure buruarekin ari naiz neure buruarekin
ez nire gainean eta eguzkiaren azpian
bitartean beraz
dagoen edo datzan
intzaurrondo galant horrekin
Zer axola zaik ordea
heure buruari hitz egin
nahiz intzaurrondoari?
Hobe egun hura mamuak
eraman balu

eraman banindu
berdin du
oraintxe ere ez lukek berandu
berdin den bezala
gizonari larrua kendu
nahiz larruari gizona
Mamuak eraman balu, banindu!
Egunaren nekea
mamuaren bizarrak
intzaurraren adarrak
baina egun madarikatu hartan
mamuteriak ere jai hartu behar
hain zuzen, hain oker.

Gure intzaurrondoari uztailean
azpitik gorantz begiratzen dionak
badaki zer den gerizpea
badakit zer den gerizpetan egotea
Gure intzaurrondoa ez dago hazirik
biziak sakaturik baizik
honen adajeak balio lezake
zibilizazio oso baten kapelatzat
Biziak sakaturik
biziari sakatzen
hostotzan agiri zaizkion
milaka barrabil
berde eta freskori
sinestekotan behintzat
eta nire burugogortasunak
edo buruberotasunak
gauzarik desburutuenak bururatzeko
grina burugabea duenez gero

mundua konpondu eta ja-jai
intzaur aleak kontatzea
bururatu zitzaidan
mundua konpontzea bururatu
zitzaidan egunean
bat bi hiru ehun
hori duk barrabileria Intzaurnio!
mila eta zazpirehun
zurrun zurrun
loak hartu herenegun
eta itzarri naiz egun
zazpirehun mila eta batgarrenean
Ondo kontatu ditudala emanik
ez daduka karga makala
gure Intzaurnio Barrabilagak

## II. Eragiok mutil

Ez dakit munduak konpontzerik duen
ez eta eduki behar duen ere
nik dakidana da munduari
eragin egin behar zaiola
eragiok mutik aurreko danbolin horri
Mugimendua da materiaren izpiritua
Ondo diagok iraultza
hobeki iraulketa
Helburu burutuak dira
buruko almorranak
kakarik ere gustora egiten
uzten ez dutenak
Badakigu norantz goazen
ez galda noraino
eragiok mutil aurreko danbolin horri
munduari eragin egin behar zaio
eraginago eta hobekiago
Zergatik?
Zenbaki kontua mutil
zenbaki kontu soila
okerrago daudenak gehiago direlako
hobeki daudenak baino.

## III. Azerimendua

Azeri aldra bat sartu zen
oilategi handi batetara
milaka oilo-oilarren ikaraz
Hemen eskandalu gehiegi diagok
esan zuen azeri buruzagiak
hau subertsio garbia duk
hots egin zuen bir-azeriak
hau zibilizatu egin behar diagu
erabaki zuten denek
Debekaturik leihoetara igotea
debekaturik denek batera kakara egitea
debekaturik inoren habian sartzea
debekaturik inoren ohean sartzea
debekaturik hegalak astintzea,
hautsa ateratzen baita
debekaturik oilarpean jartzea
azeri baten bistan ez bada
debekaturik oilo gainean

debekaturik bedekaturik
ez da zilegi bekaturik
eta oilateria guztia
bai gauza polita!
norbere habiatxoan datza
arraultzea egiteko adina indar
bakarrik eginez
oilo puta batek
sasi-arraultze bat
egin zuen arte
arauditik aparte
Burruka oilar bat jaio zen
eta kukurruku egin zuen:
oilategi honi eragin egin behar zaio
eragiok mutil aurreko danbolin horri
mugimendua da materiaren izpiritua.

## IV. Lehenengo matxinada

Platanondo izugarri zen
alderdi batean euria bazen
beste eguzkiak jotzen zuen
Hilargia paretik pasatzean
makurtu egin behar
Tximistarik erortzean
lurrera aurretik
galtzen zen adajean
Txinpantzeek,
orduko izadiko erregeek
laster bota zioten begia
baita buztana ere
platanondo eder hari
eta beren bizi-arbolatzat hartu zuten
Denbora guttira txinpantzeria guztia
bildu zen platanondo hartara
Indartsuak goi aldeaz jabeturik
txinpantze proletargoak
behe adarretan moldatu behar

eta ez gutti lur gorrian
goi adarretatik botatako azalak
edo deskoiduz eroritako aleak
kenduka elkarri
hezur eta harri
Haizeteak jotzen zuenean
orduan ziren istiluak goian
eta gozamena behean
lantzean txinpantze gizen bat
adarrik adar
dioska eta abar
erortzen ikusiz
platano mordo eta guzti.

Txinpantze nabar bat jaio zen
behetar gehienei bezala
munduan zeozer egiteko sasoia
heldu zitzaiona
platano dezenterik sekula jan gabe
Buztana bizkarrera bota
eta pentsaketan ematen zuen
jaten ezin zuen denbora
nola hil aurretik behintzat
platano betekada bat egin
Arrats gorri batez
haren zerebroko seirehun gramoak
akordiora heldurik
hain ideia handia bururatu zitzaion
non gau osoa bota baitzuen
buruari hazka eta hazka
biharamonerako ahantz ez zekion
Egunsentian txinpantzeria guztia

hango adar-abarrotsa
hango blastaketa eta diosketa
haik irrintziak eta txilioak
hura eskandaluaren eskandalua.
Goitarrek onez, txarrez, edozertaz
mehatxatu zuten behe txinpantzeria
hura terrorismoa zela
arbola hondatu behar zutela
zigorrak... gogorrak... eta abar
Ekin mutilak eta eragin
arbolari eraginik
goikoenak egin dik
eskegi zen biltzar adarrean:
Gu tontoak gaituk
Zergatik egon haizeteen zain
goitarrak hankaz gora ikusteko?
Eragiok mutil arbola zahar horri
Arbola eta denok hondatzeko?
protestatu zuen batek
eta beste batek ihardetsi:
ez gaituk gauden baino
asko beherago eroriko
Arbolari eraginik
goikoenak egin dik
eragiok mutil arbola madarikatu hori!
Hura ez zen ikustekoa
entzutekoa baizik

Lehenengo eta azkenengo
txinpantze matxinada
Paleolitikotik honantz gertaturiko
gauzarik dezenteena
Eragiok mutil aurreko danbolin horri
Txinpantzeek arbola iharrosten
ikasi zutenetik gora
ez dago beste erremediorik
denei denetik
ibiltzen uztea baizik.

Nik dakidana da munduari
eragin egin behar zaiola
Eragiok mutil aurreko danbolin horri
Mugimendua da materiaren izpiritua.

## ZUHAITZ-MINAK

Bada gurean zuhaitz bat
bir-aitonak sartua
aitonak inausia
aitaren denboran tantaitua
Ni jaiotzean
harexen orpoan ehortzi zuten
amaren umontzia
Oinez ikastean
harexen adarretik aurkitu nuen
osabaren gorpua zintzilik
Zuhaitzetik gatozela egia bada
modurik onena hautatu zuen
Jesukristo arteko tentelek
on-txarretan berezten
geroztikoek bedeinkatzen
zituzten zuhaitzak
zuhaitzari zuhaitz izatea
aski ez balitzaio bezala

Hazi bat irentsi dut
zuhaitz jaio ez nintzenez gero
zuhaitz bat erne dakidan
Erneko da bai
erneko naiz
nire gibelak damaio onura
landaratuko da bai
landaratuko naiz
nire bihotzak damaio
biziaren ritmoa
hor ditu hesteak simaurtzat
zertarako behar dut barruan
honenbesteko sokateria?
sudurrak eta belarriak
zulo zaharrak eta berriak
kimatuko zaizkit
kimatuko naiz
eta laster aitak
bir-aitonaren zuhaitzaren
ondoan sartuko nau
Ez duket txori bila joaterik
berak etorriko baitzaizkit
Ari da bat
ari zait bat
habiagintzan
ziletik iparrerantz
doakidan adarrean
To, ez dezakek harrapa
ez hadi traidore izan.

Soldadutzara bidean
zuhaizpe batean
galtzak jatsi beharra
etorri zitzaidan
gizon guztiek egiten dakiten
gauza on bakarra egiteko
Ez dago ira freskoa bezalakorik
eta banihardukan
hesteekin burrukan
eta bi pauso alboraturik
begira nengoela
kokoriko oraindik
multzo lurruntsuari
amilotx lotsagabeak zeraman
desepeltzeko astirik eman gabe
bazeraman eraman zuen
nire erraietako hazia
nire afanetako zuhaitza
Ilusioa da gizonak
dadukanik onena
ez balitz bukatuko
hain ganora gabeki.

Bir-aitonak sarturiko zuhaitza
aitonak inausia
aitaren denboran tantaitua
Ez al duk tximist
gizonetan nor jorik
zuhaitzei geldi utzirik?
Ez dago gizonarentzat emakume gerririk
zuhaitzarena bezalakorik

Ez dago emakumearentzat...
berek esan bezate hori.
Ahaidetasun gehiago
dama
jaiotzeak arbola
beraren azpian
ama
berarengandik baino
Eta bedeinkatu zuten zuhaitza
adora dezagun haritza
zuhaitzari aski ez balitzaio bezala
zuhaitz izatea
eta lagun
eta anaia
baina ez babes

Zuahitzaren gerizpera
duen herriak joera
ezar haizkora
zorrotz orpora
eta segi aurrera
zuhaitzetik zuhaitzera.

## PINUA

Belo hedakor bat bezala
mendiz handiko isurmen oro-estaltzaile bat bezala
pinua hiriko ateetaraino heldu da
eta hemen naiz hots egin du
kaleak eta autopistak irenstear
Pasaia zaleak biraoka atera zaizkio
euskal lurren nostalgia zaharra horzkatuz
mendigoizaleek harrika madarikatu dute
inbasio berdea
baina nik oleska kantatzen dut
gure mendi ibarren jazkera infinito hori
Egia da hainbat baso koloretsu ezabatu dituela
egia da hainbat baserri mendetsu ehortzi dituela
Baina nor da mendi antzuak emankortu dituena?
Nor da lur agonikoak arnasatu dituena?
Nor da bizimodu etsiak esperantzatu dituena?
Pinuak ekarri ditu hainbat etxe hogeigarren mendera
hainbat familia altxatu itomenetik lasamenera
Aberats handi askorik sortu gabe

milaka bizikera erreskatatu dituena
beren makurdura mendetsutik
Baina paisaia zaleak biraoka atera zaizkio
haren monotonia defuntua kondenatuz
Ez al da zerua ere ederra
izar hutsez landaturik egon arren?
Eta izar batek ez du pinu laurden balio
Ikusi ditut poetak pinu landarea zapaltzen
Ikusi dituk ezjakinak landare zapaldua
berena ez zena
kontuz kontuz tentetzen
Nor ote zen poetago?
Ama ezkondu ama ezkondu
Itxaron alaba pinuak hazi arte
eta ene arreba pinadi batek ezkondu zuen
Aita ezkondu aita ezkondu
Itxaron seme pinuak hazi arte
eta ene anaia pinadi batek ezkondu zuen
Euskal Herriko seme-alabek
ez denek, bai askok
pinuan habiatu zuten
maitasunaren ilusioa
Bagadian sartzean
museoan sartu naizela ematen dit
pinadian ordea
etxean sentitzen naiz
bizia sehaskatzen den sukaldean
Museoak ederrak dira
ederra maitagarri da
baina ederrena maitatzen dena da
eta nik sukaldea maite dut
Esperantza landatua langile isila

alarde gabekoa gizonaren neurrikoa
ez beste tantaiak bezala
lehenean errotua
mendeetan harrotua
abandonaturik ere konformakor
atentziorik ematen bazaio
gorantz eskertzen dakiena
sukalderaino sartzeko eskubide duena
Eder zaleek gorroto dute
pobreek ordea egunoro maite
hori bai dela benetan ederra
Garaia zen hainbeste salatariren artean
defentsore bat atera zekion
zeren gure pinua
ederra ez bada
ona bai bada
eta ona bada
ederra izan behar
Inoiz hiltzeko ordurik baletorkio
eta etorriko zaio
isil isilik joango da
etorri zen bidetik
baina nik, bizi banaiz
maite baten galera
kantatuko dut.

# GAUAREN GAINETIK ETA LOAREN AZPITIK

Ohetxo bat kulunkaz
amets urdinean
ederra hartuko duk
eror hadinean

Ohea da tramankulu bat
leku zati bat okupatuz gainera
jaiotzeko eta hiltzeko balio duena
eta lo egiteko ere bai
amets urdinean
aurreragoko zereginik
edo atzeragokorik
ez dagoenean
Bazen gizon bat
andrea alboan ez ikusteagatik
begiak atera zituena
andre bat ere bazen bezala

elkar ikusi ezinaren erremedioz
gizona itsutu zuena begi batetik
aurreko urtean begibakartu baitzuen bestetik
Ohetxo bat kulunkaz
merezi ere ez dute besterik gizonek
Emakumeak emeegiak ez balira
gizonik jaiotzean
ziletik artasikada bat
eta sasira
amets urdinean
ederra hartuko duk
eror hadinean.
Ez zuen Jainkoak ere huts makala bota
basarekin jolasean hasi eta
gizona atera zitzaionean
besteak beste hutsezkortasuna
Erromako gatzunaskan dagoelako.
Erbiak begi batekin egiten omen lo
erbi begiek beraz txandaka egin behar lo
begibakarra ez bada behintzat
Oraintxe erbitxo bat ohean!
amets urdinean
nik botako nuke gaua
muturretan zirri
bizartxoei ziri
begietara putz
hark jarriko luke aurpegikera
tripapean kili-kili
ar-emetasunak haztatu
Maitasuna ere begi batekin
egiten ote dute erbiek?
Nik botako nuke gaua

botako nuke botako nuke
Frantziarainoko uzkerra
Horrexegatik dira frantsesak hain eztitsuak
Osasunerako lehen erregela:
har haize freskoa eta bota epela
Gezurra dirudi loa den merkeaz!
Gizonak greban dagoenean behintzat
lo eta lo egin behar dik
begiak hertsirik zuloak zabalik
gure ugazabak bezala
hanka bat emaztearen izter habian
bestea kaxa sendoaren giltza zuloan
lo-zorroan lo-zorroan
baina ez dik gaur berak ere
hain lasai lo eginen
hanka biak dituela
kaxa sendora
eta katua emaztearen
aluan gora
zeren esaidak bestela
zertarako duten katutzar hura
miz-miz-miz
hala biz
hator Mizina
ene medizina
izter artean kokatzen zaio
eta nola katilu koipeztoa
miazkatzen alu zorriztoa
ile likin bat gatibatu arte mihian
ama ezkondu ama ezkondu
hobe katuarekin konpondu

ene katuño, katuño guri
gero kenduko dun iletxo hori
ama ezkondu ama ezkondu
katuak erreminta non du
ene katuño ene Mizintxo
ez nazak abandona
puntu eta koma
baina katuari gauza bat
buruan sartzen zaionean
eta beti sartzen zaio ilerik sartzen bazaio ahoan
ez dago hura aterako dionik
buruko gauza diot nik
ahoko ilea atera arte
Alferrik du ugazabandreak
esne epela isurtzea
miazkatzea nahi duen lekuan
edo sardina zahar bat ipintea
katuak ez baitio kasurik egingo
ahoko ilearena bukatu arte
ene katutxo ona
puntu eta koma
oh deabruño deabruño
egidan koma polit bat
eta puntutxo bat
heure diti punta bezain beltza
zeren Jainkoak ez zituela egin
aingeru guztiak arrak emanik
emeak erreboluziora pasatu
zirela atera behar
emakumeengatik bata eta bestea esan gero
Adan kokoloagatik izan balitz
ugazabaren baratzeko sagarrak

jorratzen geunden oraindik
nahiz eta ugazabandrea katuarekin
puntu batzu...

Gizonak greban dagoenean behintzat
lo eta lo egin behar dik
Leak bezala
fresko eta ernai azaltzeko
biharamonean burrukara
Dagigun lo dagidan lo
Learen loa larali lora
loa larelo Lea ere lo
Leak zurrun loak furrun
zurrun furrun Lea lo naun
uuummm...iiimmm...fiiimmm!
Madarikatu! hauxe bakarrik
behar genian orain
Nola liteke hain piztia ttikia
hain izorratzaile handia?
Apropos desafinatzen du gainera.

Ugazaba ugazaba
hel ondo kaxa horri
lot hakio gogorki
beterik diagok oraindik
baina laster irekiko
diagu eta sartuko
paperak ahotik
hi kaxan
kaxa lurpean
eta enpaz hirekiko
betiko

Eltxo madarikatu!
Lea iratzar badezak
presta haiteke kapamendu sintetikorako
Eltxoari barrabilak topatzen zaizkio
ez baitago arrik
ttikienik ere
hortik libratzen denik
Nola igarri arra ala emea?
Esperientzia mutil esperientzia
mikroskopo bat aplikatzen zaio
eta biribil parea heltzean
tamainu egokira
mazukada bana eman
eta zakurrari deitu
Nor ledin bihur eltxo
greban dagoenean behintzat
Ene eltxoño ene eltxoño
truka ditzagun izateak
Joaten natzaio ugazabari
eta sast ezpainean
amets urdinean
fiiimmm belarri ostean
eta gau osoa hondatzen diot
bihar ere berdin
eta etzi eta etzidamu
eltxo bihurtzerik banu!
Fakultateak galduz ikustean
bere itsas jauregira doa
lantegi-langileak utzirik
goardia zibilen kontura
hamar opor-egun eta
hamaika eme pasatzera

andrearen adordioz jakina
negozioak negozioak baitira
baina nik hara ere segitu
eta txandako emearen
gainean datzala
mundua bien
azpian bezala
ez du akaso eltxorik somatuko
baina eta baina
(minutu batzutako kontua duk hori)
niri gau osoa geratzen zait gero
eta zazpigarrenaren gainetik
desesperazioak atxeratzen du
Kosta Urdinetik
Zer monopolio eta zer koinopolio!
Horiei loa gal arazi behar zaie
Ene eltxoño ene eltxoño
hi bezalako mutilik
ez diagok zintzilik
zeren unokonotro
ehun fraidek berrehun potro
hi zintzilik habil fiindadatik
ni zintzilik ohetik
ohea Learengandik
Lea ere zintzilik
loaren ziletik
zila biziaren enborretik
enborra...danborra...
dena duk hemen elkar zintziliketa
eta zintzilikariz zintzilikari
Iso! badaude diotenak
ez daitekeela dena
zintziliketa hutsa izan

zerbaitek egon behar
duela derrigor
finko eta abar
eta egur eta gogor
Bazen bat Zintzilikario zeritzana
Intziri Mariarekin ezkondua
Beti bizi behar al dinagu
zintzilik Maria?
Kontuak kontu
Zintzilikario zintzoa
ezer finkorik aurkitu gabe
eta uzker dezente bat bota gabe
hil zela oilarite batez

Learen loa larali lora
On egin neska!
Hortxe diagon koska
Leak gorputz osoarekin egiten du lo
Leak gorputz osoarekin egiten du barre
Leak gorputz osoarekin egiten du iraultza
Lea osorik dabil beti
Learen loa laralo lira
ez hi, mokordo zipriztindu hori
zati bat hemen beste bat han
Leak zurrun loak furrun
Ohetxoa kulunkaz
amets urdinean
dena diagok ondo
Lea lo denean.

Gizonak arima eta bitxikeriak gabe
buru jirakor bat behar luke
Zertarako dut mundu osoa ikustea
neure atzea ikusi gabe hiltzekotan?
Atzetik emaleek bakarrik al dute
horretarako eskubide?
Hankapetik sarturik burua
begiratu nuen ispilua:
Ikusten diat ikusten diat
Zer ikusten duk?
Mistikoek hemendik begiratu balute
gauza dezenteagorik idatziko zuten
Ikusten diat ikusten diat
dena aldrebes ikusten diat
Zertarako hainbeste burruka?
Ez dago munduari aldrebes begiratzea baizik
eratara jar dadin
beste ipurdi askotako
kontua ere ez balitz
Baina zuloa baina zuloa
ikusten diat ikusten
ispiluko zuloa
ipurdiko zuloa
ez aldrebes ez eratara
dagoen bakarra
Dudarik gabe zuloa duk
gauza guztien esentzia
zuloa eta loa
ugazabari egingo
diogun zuloa.

Enbor barrutik itzartu naiz
betazalak haizkoraz apartatu ditut
ohe alboan Lea dago zutik
loa erantzirik
bizitza jantzirik
gorputz osoa egun berrian
osorik burruka berrian.

Berehalaxe neska
Merezi din jaikitzea
hik deiturik.

## TRISTE HAGO

Triste hago, esan zidan behin batek. Bai zera, esan nion nik. Triste hago, esan zidan beste batek ere, eta beste batek eta beste batek. Bai zera, esan nien nik beste behin eta beste behin eta beste behin ere. Ispiluari begiratu nion eta ez zitzaidan hain betalde tristea iruditu. Jendeak gehienean zerbait esateagatik esaten dik gehiena.

Logura zara, esan zidan haur batek. Bai? galdatu nion harriturik. Ni ez nintzen logura, hori segur nenkien eta barruak buelta eman zidan. Haurrek ez dakite tristurari bere izenez deitzen eta ikaratu egin nintzen.

Begiratu nion ispiluari eta haurrak arrazoia zedukan. Betaurreko beltzak erosi nituen eta haurrak hurrengoan ere logura zara esan zidan. Betaurreko hermetikoen azpian begiak soldaketaz hertsi nituen eta haurrak hurrengoan ere logura zara esan zidan, baina ni ez nintzen logura, hori segur nenkien. Ez nuen beste erremediorik begiak barrurantz bueltatzea baizik, baina barrua ikustean begiek ezin zioten eutsi eta nik ere ezin nion eutsi eta ispiluaren aurrean begiak atera eta teilatura bota nituen hurrengo katua etorri arte. On egin.

Tristea izan behar du begirik ez edukitzea, esan zidan haurrak. Bai zera, esan nion nik, orain ez diat logurarik ere edukitzen.

Bakarrik eta triste geratu nintzen baina inork ez zidan igartzen eta horrek tristurarik gehiena kendu zidan eta pozik nago zeren begiak galdurik ere, irabazten irten bainintzen.

## ILUSIOA

Gure iturriak aintzina zirristada bizia botatzen zuen
barreka zerion ura kili-kiliz nahasia
lurra jotzean birrintzen zen
eta zipriztinek sorginka saltatzen
Lehengoan joan nintzen
eta aho herdoildua
agonia disekatua
erakusten zidan
ur pitin bat, saltatzeko bildurrez
hodipetik hormara eta hormatik lurrera
noizbait iristen zelarik
Behialako ur barregilea
zirritu ezkutuetatik dario
goroldiozko larrua beratuz
isilki,
ameskaitz defuntuen izerdia bezala
nondik datorren ez nora doan
esateko gogo gabe.
Isiltasun huts hartan

tristura isilago batek ikoldu ninduen
Zer falta zitzaion iturri hari?
Ilusioa
Zer faltako zait niri
inoiz hartara banendi?
Ilusioa
Ilusioa da biziaren izpiritua
maitasunaren pultsua
arnasaren ritmoa
Ilusioa da
ez du axola zerena
bihotzaren ibilmena
Badira ilusio madarikatuak
mailutzarraren danbaketa, diruaren hotsa
ezpataren dirdira, ugazabaren abotsa
Ez naiz hoietaz ari
Gizonekin ari naiz, ez piztiekin
eta zu gizona zarela emandakoan
landa ezazu ilusioa baratzean
baratzean ezin bada haitzean
haitzean ezin bada bihotzean
Ez dio axola zerena den
txoriena maiteena olatuena
ametsena nahiz hutsarena
Ilusioa baldin bada
aski da
ez izan haizearen bekaitz
ez galda zoriona non den
jainkoen betiere linealak
ez du zure keinu erdi balio
artizarrak zeloak hartuko dizkizu
eta zuk, batez ere zuk

leihoa ireki eta bertatik saltatuko duzu
eskailerak jaisteko asti gabe
hanka hautsi arren
ez duzu minik igarriko
burua hautsi arren
ez duzu galerarik sentituko
baina ilusioa hausten bazaizu
hankak eta burua sobera dituzu
Ilusio bat eskegi ahal balitz
izan guztien ordez
ederrago litzateke zerua
Izarrekin ederra bada
ilusioren bategatik izango
Haur bat ilusioz ikusten baduzu
lagun iezaiozu hartaz konturatzen
irakats iezaiozu ilusioa horzkatzen
Pozik dagoenean ez zakizkio has
bizitzako kalamitateak kontatzen
bere poza ofsiden balego bezala
irakats iezaiozu buru eta bihotz gozatzen,
ilusioa heste guztiekin digeritzen
kezkarik gabe
aintzinako gure iturriak botatzen
zuen zirristada bezala
Zergatik hamar poz borratzeko
pena bat zaigu aski
eta hamar pozek ezin
pena bat borratu?
Gizonok zerbait sartu dugu hor
edo sartu digute naturaren kontra
zeren animaliak ezagun baititut
eta ez zaie horrelakorik gertatzen

Beti ukan diot inbidia gehiago
oilarraren kukurrukuari
Einstein-en buruari baino
baina euskaldunoi tristura
hormonatu egin zaigu
eta iraultza tristerik egin baino
hobe duk sugandilak zaindu
Badirudi munduko domadoreek
alderantziz irakatsi behar luketela
ihihi eta ahaha eta aurrera mutilak
badirudi erlijioetako talaiariek
ez luketela gozamena pertsegitu behar
baina ez da horrela
ilusioa ez baita uztarkorra
ilusioa presioa baita
araudien aurretiko bulkoa
bulko orijinala eta barrelaria
eta horiek ezin dute jasan
inork barrerik egin diezaien

Haitz uren abiada saltaria
uhaoen etzantasun marroia
iparraren freskura kilikorra
labe-ahoen bafada irenskorra
ostadarraren biribiltasun ernalkorra
zubipeen karratutasun hilotza
arboladien hostots lagunbera
ugazabaren abots herdoildua:
hemen bizi gara gu eta beharko
han daude horik eta beharko
baina ez dago han-hemenik.
ilusioa bitartean badago.

## DVORAK

Berlingo orkestra filarmonikoa dirigitu berri nauzue. Dvorak-en "Mundu Berriaren" azken mugimendua abiatzean, ezin dut eserita egon, zutik!, ezin dut hortzak eta ukabilak herstutu gabe entzun, eta bukatutakoan, jaunak, hiltzeko moduan nago baina iso, itxaron pixka bat beste behin entzun arte, eta uste dut ez dudala inoiz hiltzeko gogorik edukiko "Mundu Berria" entzun dezakedan arte, baina inoiz gor banendi hil nazazue mesedez.

Dvorak nor zen ez badakizu, lasai. Nik ere ez dakit ez nor ez noizkoa ez nongoa zen. Ez zen nonbait aramaiotarra izango eta uste dut defuntu dagoela. Dvorak diskoan dago eta ez zait besterik axola eta diskoan dagoena Dvorak ez bada ere berdin zait niri diskoan dagoena bakarrik axola baitzait, Borak nahiz Berak izan. Boligrafoa hartu, zutitu, begiak hertsi eta Berlingo orkestra dirigitu zeren entzutea gauza bat baita eta dirigitzea beste bat, edo beste hamaika gutxienez. Inoiz kapitalista izateko zoritxarrik badut, orkestra bat enkargatuko dut neuk dirigitzeko bakarrik, neuk bakarrik dirigitzeko eta dirigitu bakarrik egiteko, laster arruinatuko banaiz ere. Boligrafoa, zu-

tik!, begiak hertsi eta dirigitu. Eta benetan dirigitu, begiak hertsi eta eskuak eta tresnak ikusi, beraz ez da ezer falta. Ni ere han nago neure boligrafoarekin, zutik, hasten da kontzertua eta banoa "Mundu Berrira", ari naiz dirigitzen eta benetan dirigitzen dut eta orain ez dadukat kapitalisten inbidiarik, doazela atzetik hartzera, eta benetan dirigitzen dut, benetan eta izerditan, eta ez dadukat Karaja-en inbidiarik ere, zeren haren kontzertuan ni falta bainaiz, nirean ordea, bera eta biok eta denok gaude eta benetan dirigitzen dut begiak hertsirik dena ikusten baita. Okerrena begiak ireki eta gero ere orkestra ikusten dudala eta orduan hontzertua geratu eta Berlinera joateko agintzen diet han ere nahikoa zeregin egongo baita eta hemen geu ere nahikoa baikara, baina nola ez duten aldegiten begiak hertsi behar errealitatera itzultzeko, Mundu Berriko errealitate handira eta kontzertua benetan eta izerditan eta Kristoren airubetekin bukatutakoan, boligrafo berarekin zirrimarra hauk idazten ditut orain esan diezadazuen ea zertan diren objetiboa eta subjetiboa direlako biritxi horik, hau ez baita musikan bakarrik gertatzen, baizik beste guztian gertatzen delako gertatzen da musikan ere, eta gertatzen ez bada, entzun Dvorak-en "Mundu Berria" ea noizbait komentzitzen zareten kapitalista izatea baino hobe dela atzetik hartzea ere eta komentzitzen ez bazarete zoazte zakutik hartzera, zakuan ezer geratzen bada, eta ez bada ezer geratzen, badakizue zer egin, lan eta lan eta lan ugazabak ugazabandrea izorratuz zerua irabaz dezan.

## GAU BATETAKO IBILERAK

Giza-satorren
Goi-Estatuko
behe zatarra
Denok kainaberadira!
Kainaberak al dira
ala gari handiak?
Zingira lurra behintzat
eta biltzarrea zutik egin behar
Kolpe kolpera
urakanezko ahokada batek
kainaberadia edo garitza
toles tolesturik utzi zuen
Ihesketa orokorra
ihesketa eroa
goiak behera
beheak gora
alderik alde
dena abiada

zuhaitzak lainoak pertsonak
nora goaz baina
bideak ere arrapataka
ari badira?
Harrigarriena ez doazela
gauza guztiak alderdi bererantz
gorantz edo beherantz
edonorantz baizik
Ez da izan ere haizetea
gelditasunak krask egin du
ez al dantzuzue burrunbada
"Gerra da, gerra da!"?
Errepublikarrok geure euforian
dena aurretik generamala
mugimendu orokorra
gelditasunera itzuli zen
Eremu zabal zurbilean
aurkitu nuen neure burua
han hemen lantzean kainabera batek
tentetzeko ahalegin alferrekoak eginez
Pertsona uholde bat
barrakoi antzeko
geltoki batetako
komunetako ate zurezko
hura pasatzera gindoazela
trenak eta trenak
sator zoratuak bezala
zetozkigun atzetik
eta muturkatzen parera heltzean
beren zerri mutur izugarriz
"Bildur-kumeak!
Horretarako hasten

al zarete gerran?"
Eraman garamazte
zahar eta gazte
tren mutur zerrikoiek
Zertan igartzen diek?
Eraman garamazte
zahar eta gazte
galdu dugu gerra
eta laster bizia

Pezoi handi batetara heldu nintzen
eta erori ere eroriko
ez banintz kokoriko
piz egiten hasi
ez banu ikusi
autobuskada handi bat behean
Nola egon zitekek oraindik
norabait joateko jenderik
gerra galdu eta gero?
Bertan beheratasun hartan
hara lagun bat kale ertzean
Eh! itxaron apur bat!
Kaleak detenitzen zebiltzan
kaka-larruetariko batek
alto eman zidanean
esku basaztuak erakutsi nizkion
errugabetasunaren agiritzat
Irribarre zatarrez joateko agindu zidan
Zenbat denbora behar duk
kaka-larru horri txitarena egiteko?
Ez nuen inguruan ikusten
ez egiteko arrazoirik

kaleak huts hutsik baitzeuden
baina aurrera jo nuen
golkoa bete bildurrez
Bost pausu aurrerago
kapotez baturiko
multzo handi batek alto
Bigote triangular hartatik
igartzen zitzaion
aurpegia non zedukan
ipurdia ez bazen
Dokumentazioa!
Hauxe duk errementazioa
Karneta eskaintzean
''ba al dituk hamasei urte?''
galdatu zidan aluak
karnet lapurra naizela
adieraziz bezala
Burla apalgarria
gibelean harria
lehentxoago hain zuzen
ez banago hain oker
eskaparate handi baten aurrean
lur jota geratu bainintzen
neure burua erreparatzean
hain zurbil, hain mehatz
Zerri madarikatuak!
Edozer esan dezaketela uste diate
gerra irabazi dutelako
eta gerra ondoren
neure burua ere
lepoa bederen
galdutzat jo nuen

Bizitza ametsa bada
ametsa ere bizitza da
bizitza tristea sarritan
zeren behintzat ametsetan
edozertarako ausartzia
behar luke batek
gerta litekeenik okerrena
itzartzea baita.

# MAITASUNA DELAKO HORI

Maitasuna da hitz bat
gatzaldi on bat eman
eta ehortziko nukeena bikupean
hurrengo mende arte guttienez
zeren zer zerikusi daduka elkarrekin
amak haurrari diotsan
aita sainduak bala-balatzen duen
bankari jaunak dirutzen
Julietak hasperentzen
olerkariak eztitzen
gobernariak uzkertzen
gaztetxoa esateko lotsa den
eta labariak sekula esan ez duen
hitz horrek?
Zer amorrua hizkuntza bat aurrera
hainbeste kostaturik atera
eta gero
hitzek bakarrik balio
ulerturik daudenak ulertzeko

Euskaldunen ez dakit zenbatgarren
tentazioan eroriz
banago hitz berri bat asmatzeko ere
maitasun horren ordez
zertarako ordea
laster baitute txandako
igelek ikasiko
eta entzun araziko
apoen jolaserako

Ez, hitzak asmatu gabe
ahantzi egin behar dira
edo mihia eskegirik utzi
katuak harrapatzeko lekuan.

# GALDERA NAGUSIA

Galdera nagusia da
zergatik den gizona
hain zapaltzaile
hain zapal erraz

Izorraturik egotekotan
izorratzaile dezenteek izorratzea
izorramendu erdi litzateke
Baina kakontzi horiek
uretatik pasaturiko
arraultze pare horiek?
X.H.-ko ugazaba papartsu
bezain ez dakit zertsu hori
Arkimedesen balankatik mintzo den
direktore harmatu hori
uzker batekin lehen osoa
borratzeko kapaz dirudien
ministro plantatu hori
atera ezazue zulotik

eta ihesi ikusiko
kukaratxen atzetik
Edonork uste lezake
heriotza zigorrak
"pultsurik dardaratu gabe"
firmatzen dituen kapitainak
ingudean eginak
dituela saihetsak.
Utz bakarrik kalean
eman nahi dituen harmak
eta lepoa buru eta guzti
jokatuko dizuet
menderatu baietz
gure mutil koxkorrak
bere tiragomarekin
Badira ametsak
lotan bertan ere
esan erazten dutenak:
hau ez zitekek izan
ezin dik inola ere izan
eta esan eta esan
azkenerako itzarri
Badira egiak
itzarrik ere
esan arazten dutenak:
hau ez zitekek izan
ezin dik inola ere izan
baina alferrik esan eta bir-esan
ez baitago nora itzarri
Amaren sabeletik bizitzara
saltatu nuenetik gora
ez zitzaidan askorik kostatu

munduaren ulerpena
on-gaitzak haurride bainituen
eta heriotza josta-lagun

Baina barruak ez larruak
ez zidana ematen
nola zitekeen
benetan egon
pinuari arroxina bezala
pozoina darion
giza-kumerik.
Buruarekin horma
edo hormarekin burua
jotzeko ere banago
neure garaunetan dagoelakoan
gakoa
ea kolpe azartaturen batek
bir-lekuratzen duen
errealitatea
Kea bezala zaizkit
izanaren zulotik
ateratzen nautenak
eta kea denan badago
ito egin behar
Baina ito arte?

Ikusi ezik ez dut sinetsiko
esan zuen burugogorrak
Nik ez dakit zer buru dudan
ikusiago eta ezin sinestenago baitut
Ez da hauzi filosofikoa
zorionez edo zori-hobez

libre bainago filosofiatik
eta izen oneko alabetarik
baina bueltak eta bueltak emanik
-gizonak bere buruaren irudira
egin baitzuen errotarria-
amorrua ematen dit
galderarik tentelenetan
bukatu beharra beti
ea substantziaz ala akzidentez
direlakoak diren
ala esistentzia esentziaren
anda-buru ote den
ala Platon eta denak
marikoiak ziren
ala halabaina...
ala nola baina...
honelako galderarik bururatzen
edo ipurdiratzen zaionak
bila lezake farol on bat
hasteko zentzu bila
galdurik baitu segur asko
urrun galdu ere segur oso.

Galdera nagusia da
zergatik den gizona
hain zapaltzaile
hain zapal erraz
zergatik beraz
hain guttienek dituzten
hain gehienak irensten
hain guttienek hain gehienak
hain guttienek hain gehienak

# TRISTURA

Begiari tristura badario
eman buelta barrurantz
harrikadak hustu dion
dingilizka darion
zakurraren begiak
min guttiago ematen baitu
begirada tristeak baino.

Begiari negarra badario
burko isilaren kontra
-tristurak bustidura ere
zurrupatu ez badio-
eman su eta erre
beste begirik han
etzan baino lehen

Larruari tristura badario
eman buelta barrurantz
hobe baita alderantzi
gorria erakutsi
zarrastaturik

izerdiak eraman dezan baino
tristura tantarik

Gorputzari tristura badario
nondikbait
eta ez jakin segur
nondik
eman buelta buru osoari
hobe baita barrurantz hertsi
eta tristura bilakatu
bere jaiotzaren hilobi
haren zipristinik inori
ezarri baino lehen.

Tristuraz ari naiz tristuraz
ez triste egoteaz

Ameskaitz batek iraulkatu nau
aintziraren ingurura
urgune zabal kolorga hura
beste munduaren muga
Nire itzala luperiaren
erdian han kokatu da
oinak ezartzen beherantz sartzen
galtzen naiz joan naiz barrura
basatza nagi hondogabea
hori da jaunak tristura

Tristuraz ari naiz tristuraz
ez triste egoteaz

Nola daiteke hain lur
berde eta bizitsuan
hain herri tristabera?
Euskaldun gehiago urkabera
eraman du tristurak
desesperazioak baino
itsasoan laino
hegoatik gogoraino

Tristuraz ari naiz tristuraz
ez triste egoteaz

Abere haundi bat giza golkoa
duena bere gordegu
akaso lotan baina irteteko
alferrik egin erregu
Ez du adarrik dena da aho
ez deabru ez aingeru
hura barrúan daramatenei
zer esan behar diegu
tristura zer den ez dakienak
ez ikastea hobe du

Tristuraz ari naiz tristuraz
ez triste egoteaz

Erhaztun gizen bat erreka alboan
azkasi urtetsu baten bueltan
Gure aurreko
gure lurreko
herriaren hil koroa delakoan
haragizkoa izan

haragizkoa benetan
erdia musker
erdia aingira
muskerrak aingira
atzerik hara irensten
aingirak muskerra halaber
Gizonarekin batera
hasirik burrukan
oratu zioten elkarri
konturatu arte
tratua egin arte
burruka luzatzea
sekulorun sekulotan
hazi ahala elkar jan
elkar jan ahala hazi
hauk duk hau bikoka
ez bi
muskerra eta aingira
maitasunaren aingira
tristuraren muskerra
bat baizik
muskerraingira

Azkasia botatzen duen haizkorak berak
erdibituko ahal du urriki gabe
piztia asegaitz hau ere
maitasunaren aingira
tristuraren muskerra
Ez daiteke permiti
tristurak maitasunari
maitasunak tristurari
diezaion ken-eman

bizigarria
hilgarria.

Tristuraz ari naiz tristuraz
ez triste egoteaz

Neure burua ireki
eta zabal zabaldurik
ardi larrua sikatzeko bezala
zientziari deitu diot
eta galdatu non dauden
tristura jariatzen duten
iturri madarikatuak
Ez dakiela esan dit
baina nik badakit
hortxe daudela nonbait
glandulak edo filamentuak
hariak edo laminak
operatu beharrekoak
izurrien ernamuinak

Zezena ezagutzen dut
anaiak baikara
badaki zer den tristura
Idia ezagutzen dut
lagunak baikara
ahantzi zaio zer den tristura
Horregatik ote da?
Baina nola esplotatzen duten
nola lan eragiten
nola eta nolako lanak!
Hori ere tristea da jaunak!

Tristuraz ari naiz tristuraz
ez triste egoteaz

Gauza bat dago bakarrik
tristuraren aurretik:
Gosea
Ailedi bihur mundua
ifernuko galdara
abere orojale hori
hiltzeko baldin bada

# KANPORA

Kanpora zuriak -hots egin genuen
Euzkadin ez da behar zuririk
elurra izan ezik
Eta zuriak kanpora irten ziren
beren hortz zuriak garraskatuz

Kanpora beltzak -hots egin genuen
Euzkadin ez da behar beltzik
zozoak izan ezik
Eta beltzak kanpora irten ziren
beren amorru beltza arrastatuz

Kanpora gorriak -hots egin genuen
Euzkadin ez da behar gorririk
artaburuak izan ezik
Eta gorriak kanpora irten ziren
beren haragi gorria zarrastatuz

Kanpora kolore guztiak -hots egin genuen
Euzkadin ez da behar kolorerik
urtaroenak izan ezik
Eta koloredun guztiak kanpora irten ziren
zurien beltzen eta gorrien atzetik

Eta orduan
geu bakarrik geratu ginen barruan
eta orduan
geu bakarrik geratu ginen kanpoan

# ABERRIAREN SEMAFOROAN

## I. Subasta nagusia

Eguzkia mendiz handik agertzear zegoela eta oilarrak egun berriari azken eupada egin berri ziola, adarraldi luze bat entzun genuen hiririk herri eta kalerik mendi: har bakoitzak bere aberria eta denak enparantza nagusira. Loa agurtzeko astirik gabe ni ere enparantza nagusirantz abiatu nintzen neure aberria golkoan. Bazen han jendea, bazen han joan-etorria, ezagunak ezezagun eta ezezagunak ezagun egiteraino. Iskanbila unibertsalaren leherkundea zirudienean, gizon haundi batek bozgorailu haundiago bat hartu zuen:

- Jaunen andreok, andreen jaunok: subasta hastera doa, anitz subastagai daukagu gaur eta denen artean... Aberria, gure Aberria. Halako txilioketak dardaratu zuen enparantza non ez bainenkien alde ala kontra zeuden.
- Gehiago, nork ematen du gehiago aberriagatik?
  Neure hesteei ezin eutsirik, ahal bezala harrapatu nuen mikrofonoa:

- Baina nola ausartzen zarete, zerri belarriok, aberria subastatzera?
- Isi, olagarro bizarmotz, -erantzun zidaten- aberria ere jenero bat duk beste edozein bezala
- Iso, aker bizartsuok, aberria sakratuegia duk...
- Ez diagok ezer zakraturik kotizatu ezinekorik. Gehiago, gehiago, nork ematen du gehiago aberriagatik? Atzo Hirutasun Donea subastatu genian eta Batikanok jo zian goren.
Gehiago, gehiago, dolarretan nahiago
baina pezetak ere onak dira
- Zuek al zarete aberriaren defentsoreak?
- Defendatzeko hain zuzen, defendatzeko. Gauza batek zenbat eta gehiago balio duen hainbat eta gehiagotan aseguratu behar duk. Futbolari onak hankak aseguratu behar dizkik, lapur onak hankak eta eskuak. Zer abertzale edo zer barrabiltzale haugu ordea hi?

Esperantza galdurik enparantza utzi nuen, neure burua galtzarbean eta aberria golkoan.

# II. ALTXOR GORDEA

Osterik ez duen haizmendia pasaturik bere iturburura itzultzen den erreka saltaturik gerizarik gabeko tantaidia zeharkaturik hilargiak umeak egin zituen altzogunera heldurik bada leku bat neuk ez beste inork ez dakiena bada zulo bat ezein izpiri-tuak ukitu gabea.

Joan eta joan hantxe gorde nuen ene aberria. Haitzulo ahoa haitzurtu eta neure zainak sartu nituen bertan eta bihotzaren goitikaz ongarritu. Hesi bat egin nion neure hesteekin eta haitzuloa umontzian bezala geratu zen. Badaezpada harri zuri handi batzu eta noizkoak ziren ahantzirik zeuden enbor na-bar batzu inguratu nituen. Eta han geratu zen ene aberria enparantza nagusian baino hobeki aseguraturik. Urtean behin, hego-haize denboretan buelta bat egiten nion, ez segur ez zegoelako, segurantza hartaz neuk gozatzeko baino.

Urte batez ordea, haizmendia oste eta guzti zegoen, erreka itsasorantz zihoan, tantaidia gerizadun zegoen. Hilargi umeen

arrastorik ez zegoen eta bidea galdu nuen, bidea eta aberria, eta hesteak eta zainak. Urtero saiatu naiz baino ezin dut aurkitu neuk ez beste inork ez zekien leku hura ezein izpirituk ukitu gabeko haitzulo hura eta hemen nago subasta nagusira itzultzeko tentaturik nik ezin baitut aberri gabe bizi.

## III. Hori da nire Aberria

Katuek zazpi bizi eta txakurrek hamazazpi heste
trailer diganteen azpian galtzen dituztena
arima osoki hilek kandela erdi biziei
negarra eta prezioa ematen dietena
hori da nire aberria

Lantegien goitikaz eta gure aitaren izerdiz
errekak hartziturik datozena
arrainek arnasa hartzeko eta tristuraz ez hiltzeko
amua horzkatzen dutena
hori da nire aberria

Bidasoako ezpata lasterrak hego iparrak apurtzen
eta Kantauriko aparrak desurtzen dituena
haize mokoluzeak leiho zirritutik
adarra eta larrua jotzen didana
hori da nire aberria

Amodio ur bedeinkatutan hil eta emagalduen
ur madarikatutan biztu zena
bularrak aspertasunez erortzen eta izterrak
inertziaz zahartzen direna
hori da nire aberria

Tantai errotsuen eta mendetsuen ordez
tximini ketsuak gailendu direna
dolare blindatuak ugazabaren begipean
milaka bizkar lehartzen dituena
hori da nire aberria

Euskarak bere etorkizunaren hildoa
haitzean horzka ireki behar duena
munduko zaharrena izanik munduratzea
mundualdi osoa kostatzen zaiona
hori da nire aberria

Adarrak goizero zabaltzen eta
arratserko prorrogatzen duena
oilarrak egunez gorteiatzen eta
mozoloak gauez bijilatzen duena
hori da nire aberria

Perretxikoak jaio aurretik sekuestratzen eta
dotegabeak hil aurretik beztitzen dituztena
kotxea aparkatzeko ordu bete eta
ifernura heltzeko segundo bat behar dena
hori da nire aberria

Mailutzarrak burdina torturatzen eta
belarriak anikilatzen dituena
inbutu oro-irenskorrak bekokiko zumua
garrafoi hondogabeetara daramana
hori da nire aberria

Zozo bikoteek untzi espazialei beren habien
teknika txistukatzen dietena
giza bikoteen hezurrak bortu muturretan euriztatzen
eta auto makurretan erreumatzen direna
hori da nire aberria

Izerdia dela aberria entzutean
otso belarriak jartzen dituztena
lurra ere aberria dela entzutean
ostrukatzat jotzen zaituztena
hori da nire aberria

Inguramenduaren goragalea
hortzak hortzen kontra garraskatzen dutena
kamamilak inoren baimen gabe jaiotzen eta
kilkirek lutu guztien kontra kantatzen dutena
hori da nire aberria

Askatasunaren etorkizuna urteroko enarek
dakartena eta daramatena
esperantza bihotz berrietan eta komoda zaharretan
etsigabeki ernetzen dena
hori da nire aberria

Ttikitasunaren desnatur lege guztien kontra
dirauena eta diraukeena
mendeen azkenetik denbora berrien hutsunera
hemen gaude oihuztatuko duena
hori da nire aberria

Eta hau eta hori eta bestea
eta ni eta zu eta besteak
hori gara gure aberria
hori da nire aberria

## KALIREN HILARGIKARIA

### I. Gure maisu tentela

Gauero intzaur lapurretan
egiten dute gurean
Zain zegoen aita
ganbarako leihoan
eskupeta eskuan
Oinaztu berdeak Anbototik
keinu egitean
tximinia luze luze egin zen
bere zulo luzean gora
eta teilatutik hara ari zen
intzaur lapurretan
hilargipeko orduetan
Danba tiratu zion aitak
jirafaren bat zelakoan
Arraioa, tximinia izan ordea
eta sukaldera jaitsirik
tiraka laratzetik
bere lekura ekarri zuen
tximinia lapurra

Gure maisu tentelak barre egin dit
Barraskilo bat horri gainean ipinirik
harexek eginiko letrak
eramango dizkiot bihar
eta honelako gauzarik
neure koadernoan bakarrik
idatziko dut
eta oherakoan
hilargiari zabalik
utziko diot leihoan
gauero horrialde bat
irakur dezan
lo nagoen bitartean

## II. Lehenen galduriko laguna

Badut lagun handi bat
mutur erreak eta oin nabarrak zituena
lehenen eduki eta
lehenen galdu nuen laguna
Usakume bat erreparatu zuen
erdi hegan zekiena
eta ni ondoren
eta biok atzetik
abiatu gintzaizkion
Nire lagunak hegazti bategatik
buru eta buztan galduko zukeen
eta nik, ah!, usakume bat edukitzeagatik
eskuetan bizirik
zeru lurrak salduko nituzke
baina harrapatzeko baino gehitxoago
eta eskapatzeko baino guttitxoago
baitzekien hegan
oihanean barrura
gintuen eraman

ilusio hurbilen eta
esperantza urrunen bidetik
Ez dakit zenbat ordu eta
ibiltze generaman
bakarrik dakit
atzez zetorkigun itzala
aurrez zihoala
gure dobleko luzeran
eta inguru eta tantaidi haik
inoiz ikusteko nituela
Nire lagunari ez zitzaion
ez ordurik ez lekurik axola
libre ibiliz gero
Usakumeak errekatxoa
juxtuan bestalderatu zuen
hegada ezbaikorrez
derrigorrez
eta nire lagunak buztan eta guzti
bota zuen burua uretara
Hatzeman hurran zedukanean
minik egin gabe harrapa zezala
deihadarka ari nintzaionean
horbel hotsa atzeko aldean
ene ama, zer duk hori
otso bat zetorkidan
Bel!, Bel!
otsoa bi itzaletara dut
Bel! ama! Bel!
eta hala zen izua nitu
non bainintzen bitu
bata harri zedin
bestearen ikaraz
Baina hara ez dakit nondik eta nola

Bel otsoarekin zela
hil-biziko deman
Nola adierazi lagun txiki haren handia
bere bost zen otsoarekin
hortzak trukatzera ausartu zena?
Multzo iletsu hartan
hortzen eta bitsen zuritasuna
bakarrik ikusten nuen
eta Belen oin nabarrak tarteka
Ez dakit non neuzkan eskuak
baina begipeetan geratu
zaizkidan hatzaparkaduretatik
-horrexegatik dela uste dut
nire begirada tristearen kontua-
aurpegian josirik eduki behar
Multzo buztantsua iraulka zihoan errekarantz
nire laguna irentsirik zeramala
badarama, ene ama
erori da uretara
baina ez antza irentsirik
ura jotzean erdibitu egin baitzen
eta otsoa handiko bazterra harrapaturik
usakumearen direkzioan aldendu zen
Bel han utzirik
ur-beherak zeramana
eraman darama, ene ama
zer gorridura duk hori, Bel?
ene ama, Bel, ene ama
lepotik odolusten ari da
eta tantaiak geldi
tentelki eta tantaiki
nire laguna urak daramala

ikusi arren
Bel, Bel!
bazeraman, eraman zuen
eta tantai tentelak geldi
*eraman zuela ikusi arren*
Lehenen eduki eta
lehenen galdu nuen laguna
Ez dakit tantaiak mugitu ziren
ez dakit lizarrek egin zuten negarrik
nik bakarrik dakit
uretara bota nuela burua
lagunari segitzeko
bakarrik ez geratzeko
baina uste dut ez nuela bota
erori egin zitzaidala baizik
Gurgur batzu entzunik
ez naiz beste ezertaz oroitzen
altzo zabal batetan ahospez
itzarri nintzela baizik
Ez naiz, ez, ametsetatik itzarri
altzo hau ez baita amarena
andre lodi batena baizik
eta ura eta ura zeridan ahotik
sudurretatik begietatik
eta zulo guztietatik
aspil zuri batetara
Emakume berbaroa zen inguruan
eta batez ere
arnasa bueltatzea lortu nuenean
''ez egin hitzik, Bel etorriko duk''
esan zuen amaren sabeletik
ezagutzen nuen abotsak

bekokia eusten zidalarik
amaren sabeletik irtenaz batera
ezagutu nuen eskuak
baina nik
on-gaitzak berezten jakin ez arren
badakit Bel ez etortzeko lekura
joan dela

Lehenen eduki eta
lehenen galdu nuen laguna

Erreka ahotik bota behar nuen
eta baneukan esperantza
urarekin batera
Bel eroriko zela
aspil zabalera
baina Bel ez da agertu
Lehenen eduki eta
lehenen galdu nuen laguna

Mutildu nintzen mutildu
baina ez Belez ahantzi
batez ere entzutean
bere lagun gal berria
"ene bihotz erdia"
deitu zuela batek
Nor ote zen haren "bihotz erdia"?
Bel bera segur asko
zeren norgatik esan zitekeen halakorik
Belgatik izan ezik?
Idazle hura neure laguntzat
hartu nuen Belen ordez

jakin arte
-madarikatua poesiak hegan
ikasi zuen eguna-
enperadoreen atze garbitzaile
eta enperatrizen aurre miatzaile
izan zela

Lehenen eduki eta
lehenen galdu nuen laguna

Klasikoen bikaintasuna
dagoen lekuan badago
kakarraldoekin geratzen naiz
mokordoaren azpian.

## III. Bigarren galduriko laguna

Eskolara lehenengoz sartu nintzenean
nindutenean
aurrenengo iladako
bazterrerengo mahaitxoan eseri nintzen
ninduten
Zorroa mahai gainean
eskuak zorro gainean
okotza eskuen gainean
egon eta egon
zeozer pentsatzera benturatu nintzenean
-pentsamendu bat harrapatzea baino
nahiago nuke neu harrapatzea ere-
hura saihetsetakoa hartu nuena
Orduantxe ohartu nintzen
alboan lagun bat zegoela
eta mahaia bikoitza zela
Isi! ziostan
ez dakit zergatik
nik ez bainuen hitz egiteko esperantzarik

-Ikusten duka neskatto hura?
Orduantxe lehenengoz begiratu nuen albora
eta konturatu neskak zeudela erditik harantz
-Bigarren iladan handik honantz bigarrena
Kalkulu handiegiak ziren niretzat
-Ile luze eta jertse gorriduna

Jertse gorriduna entzunez batera
aurpegitxo bat hauteman nuen
maistrari begira begira
-Bada, hori hil egingo duk laster

Nire sozioa
berria emantzat emanik
formalitatera itzuli zen
Ez nuen ezer pentsatu, bai begiratu
Aurpegi huraxe zen eskolan
ikus gogo nintzen gauza bakarra
Burua jiratzeko bildurrez
begiak okertzen bide nituen
-norantz begiratzen duk, ume
begiak alborantz joanak baitituk?-
Baina ez nintzen betoker geratu
neskatto jertse gorriduna
hil egin baitzen
nahiz eta haren husgunera
berdin begiratzen jarraitu
beste bat han eseri arte
eta batez ere mihia atera zidanetik
ez nuen gehiago harantz begiratu

Hil egin zen, bai, hil
neskatto jertse gorriduna
-Zer esan nian nik?
esan zidan sozioak

Haren hiltzea eta hiletak
nire izenari loturik geratu dira herrian
nola andre diti handi batek ninduen
neskatto hilaren ohe ondora eraman
nola ez nintzen handik mugitzen
ez eta mugituko ere
etxera bidali arte
nola inork igarri gabe
denbora guztia
orduak eta orduak
eskutxotik oraturik egon nintzaion
nola andre zabal batek altzoan hartu eta:
-Zer esan diok, bada, Leari?
- Berarekin ezkonduko naizela
- Eta zer esan dik berak?
eta nik buruarekin baietz
nola, nola eta nola...
Ni guztiaz gogoratzen naiz
baina kontatzen didatenaz
guztiz beste modu batez

Bada ordea gauza bat
inork ez dakiena
Leak eta biok
bakarrik dakiguna
Learen katabuta kanposanduan
jendeak ikusteko zabaldu zutenean

hantze egon nintzen ehortzaile bizkartsuak
kanpora bidali arte
-Hik ere beste mundura joan nahi duka?
Baina ehortzailea
soinekoak aldatzeko edo
ate nagusia hersten ikusi nuenean
ezer pentsatu gabe
neure buruari ere ezer esan gabe
jaiotzatik bainenkien
zer egin behar nuen
kanposandu osteko horma zaharrean gora
han nintzen gainean
zazpigarren ahaleginean
han zegoen geldi geldi
Learen katabuta
aurrez aurre
eskolan bezala begirik
okertu beharrik gabe
Hormaz barrura eskegi
saltatu, katabuta ireki
eta han nintzen barruan
Learen ondotxoan
Taparekin batera erori zen iluna
beste munduan gaude
betiko gainera
Learen husgunera
begiratu beharrik ere ez
hil beharrik ere ez Lea ikusteko
- Ehortzailea, ehortzailea!
ehortzailea dun!
Zulogintza bukatutakoan
bi usin, hiru eztul eta lau zintz egin zituen

katabutari korapilo higikor bat egin
eta: Madarikatua!
deabrua sartu al ziaiok haur honi
honenbeste pisatzeko?
Iluna bezain barrura
sartu zitzaidan bildurra
Ez dakit zertarako
ehortzailea joaten somatu genuen
Goazen hemendik Lea
Baina katabuta
sokaz lotuta
Ena ama!
Hezurretik hezurrera
zebilkidan bildurra
Goazen hemendik Lea
ito behar nuen
halako batetan
nik al dakit nola
tapa zabaltzea lortu arte
Aingeru jagolearena sinesteko ere banengoke
beste sarritan abandonatu ez banindu
Salbo gaitun Lea
isi, badiatorren
Panteoi ostean ezkutatu ginen
Ederra egin zionagu
deabrua lotu beharko din
soka tentel horrekin
Katabut aurrean plantatu zen ehortzailea
Madarikatua! Hemen ibili diabiltzak!
Soka hauk utzi baditut honela
eta ez bestela
hortzegile nauk
eta ez ehortzaile

Altxatzen hasiz batera
utzi zuen bertan behera
Madarikatuaren madarizakurra!
Ederra egin zionagu Lea
Ehortzaile ehortzaile
heure burua ehorztea hobe
Eguzkia ostendu zen
ilunabarra bazetorren
baina ehortzaileak ehorzten ez bere bururik
baizik azkenean
sokatik eskegirik
katabuta tak kokatu zen zuloan
Lurrez estali hankekin zapaldu
eta erremintak bizkarrean
kanpotik hertsi zuen
kanposainduko ate tristea
Urrengorarte sano bagara
areago ez bagara
Salbo giauden Lea
goazen
Hurrengo gaubelan kontatuko dut
zenbat kostaturik
atera ginen kanposaindutik
baina ez dut kontatuko
hilargiari izan ezik
nola jo nuen lurra
kanpora saltatzean
jo ninduen lurrak
konturatzean
bakarrik nentorrela
barruan geratu zela

## IV. Geratzen zaidan laguna

Lagun asko eta handiak
dauzkat lauoinekoen artean
baina zergatik ez diete ama
astoei izenik ipinten?
''Gure astoa, hauzoko astoa''
beti astoa eta astoa
Badut lagun bat
laguntxoa niretzat
Beltx izena duena
Ezin eskolatik etxeratu
Beltxengandik pasa gabe
eta nola Beltxek ez dakien
denbora zer den
berandu etxeratu behar beti
amak agiraka egin behar beti
baina nik badakit amak ere
badakiela alferrik dela
Atzo esan zidan

osaba Mauli esango ziola
ijitoei sal nazala
asto eta guzti
zeren ai ama
Beltx ez baita gurea
osaba Maulena baizik

Eros berri zeukan osaba Maulek
Niri asko gustatzen zitzaidan
baina urrundik, oso urrundik
Haren gainean jartzea
oinaztu gainean bezala zen
ilusio hutsa
hain polita hain gaztea
noiz ibiliko ote naiz oinaztuan?
Osaba Maulek erabiltzeko agindu zidan
apustuetarako bereziki erosi baitzuen
Igande eguerdioste batez
Belarreko landara neraman
golkoa bete erbi taupaka ari zitzaidan
bueltak eta arineketak
gora eta behera
eragiten nizkion
baina bildur igoteko
Astiro astiro urreratuz ferekatuz
sekula inori esan gabeko gauzak esanez
tak igon nintzaion azkenean
eta ez zen ezer gertatu
Arre eta tiki taka
iso eta geldi
arre arre eta lauhankan
iso iso eta geldi berriro

Oinaztu gainean ibiltzea
falta zait bakarrik
- Zer izen ipintea nahi dun, Beltx?
eta esan zidan:
- Gu bion arterako Beltx
bestela astoa
Bai izen polita daukala Beltxek
Beltx bera ere polita baita
- Nola bururatu zain
horren izen polita Beltx?
Txakurra ere Bel daukagu
Bel eta hirurok elkarrekin
ibiltzen gara beti
Beltxi asko gustatzen zitzaion
Belen izena
Harez gero bi ume egin ditu
eta zenbat apustu irabazi!
Itzela da Beltx
hilargiak atzetik segitzen dio
baina batzutan, baina batzutan
zer pena sentitzen dudan!
Beltx giri denean eta
Lea negarrez dagoenean
ez dakit norantz begiratu
Eta oraingoan, oh Beltx
osaba Maulek nahi ez
astarrik ezarri
Sosega hadi Beltx pasatuko zain laster
ez hezan ahorik horrela ireki
eguerdiostean ezkutuan haramaket
Zugadiko astarrarengana
erreka ondoan loturik dagoena

Baneraman bagindoazen
baina beti zeozer gertatu behar
osaba Maulek eup atzetik:
Nora daramak astoa?
Horixe besterik ez diagu behar!
Etxapeko ereinotzari
Beltx berriro lotu nionean
erreka lurpera sartu zen
ereinotz loreak erortzen hasi ziren
Nik sentitu nuena
huraxe dela uste dut
tristura esaten dutena
Beltxi ahotik zerion bitsa
pinuen eta lainoen kontra
apurtzen zuen haizeak
eta eguraldi guztia bitsa zen
Entzun dun osaba Maulek zer dioen
hi jokorako haiz ez besterako
nik nahiago niken bestea
baina osaba Maulek agintzen din
Beltxek atzea ematen dit
ahoa hertsi-irekiz
sosega hadi Beltx
nik ezin dinat ezer egin
jakin badiakinat baina...
Lea bahintz ere
Oh Beltx pasatuko zain
neu naukan zain
nola nahi dun ni
horretan has nadin?
Alferrik alferrik
baina heuk nahi badun...

Mundu guztia biagoan dago
Beltx eta biok izan ezik
Enbor baten kontra jarririk atzez
esku batekin bizkarrean hazka
bestearekin buztana alboratu
baina ezer ere ez, ezer ere ez
behar denik ezer ere ez
zer egitea nahi dun bada honekin?
Bai larri egon behar duela Beltxek!
Buztanpeko berotasunak
urtu behar nau gerritik behera
Bel ere afantsu dabil inguruan
baina hik neuk baino guttiago Bel
afan hutsak ez dik balio hemen
Enborrak huts emanik
dingilizka geratu naiz
Beltxen atzetik
galtzak erori zaizkit
eta haien gainera neu
Alferrik Beltx
lagunak gaitun
beti izango gaitun
baina ez honetarako
ezin honetarako
Eguraldi guztia
bitsa eta ereinotz lorea zen
Besoa?
Oh Beltx, horren derrigorra al dun?
Kontuz kontuz sartzen diot eskua
badakit gauza kuriosoak
daudela hor barruan
ukondoraino sorbaldaraino

gehiago ezin
buru eta guzti sartu ezik
orduan bai zabaltzen zituen hankak Beltxek
orduan bai bazerion bitsa ahotik
Oh Beltx, ahoraino erretzen hago ordea
baina Beltx ez zen nekatzen
Nik uste dut gustorago zegoela
besoari apur bat eragitean
Ahalik ondoen egiten nuen dena
baina Beltx ez zen nekatzen
beso eta neu irentsi arte
eta besoa busti busti
eta bero bero sentitzen nuen
Noiz arte honela Beltx?
Hauxe azkena ezin dinat gehiago
Erreka lur gainetik agiri zen berriro
ereinotz lore horiak beren adarretara itzuli ziren
zeren eguraldia ez baitzen orain dena bitsa
Biharamonean ere Beltx
bero zegoen oraindik
eta berdin egin nion nik
baina bezperan baino hobeki
Hurrengorako pasaturik zeukan
eta ilunabar gorrian
haizeen sorguraino
eraman-ekarri ninduen
nekatu ere egin gabe
Honela korritzekotan
apustua irabazirik daukan
baina ez zen horregatik
pozik zegoelako baizik
aurreko egunengatik

eta horregatik
nik badakit
Beltxek pozik
erabiltzen nauela
nahiz eta oinaztu gainean ere
ibiltzea nahi nik
Belek bakarrik daki
Beltxi zer egin nion
eta lurrak
baina lurrak ez dio
inori ezer esaten
norberak nahi izan ezik
Hilargiak hau irakur dezanean
zer pentsatuko ote du?
Tenta tentaturik egon nintzen
Leari kontatzeko herenegun
bere bederatzi urteengatik
bederatzi bederatziko
zabualdia eragiten
ari nintzaionean
Bai gustatzen zaiola Leari
zabuan ibiltzea
eta niri sakatzea
baina azkenerako jota
geratzen naiz beti
eta bera fresko fresko, jakina
Bederatzi aldiz bederatzirehun
nahi luke Leak baina
oraingoxe martxan ere
komediak daudeke
hemeretzi urte ditunean
zeren gainera nahi du

hitz eta hitz egin diezaiodan
Begiak hertsi hertsirik
hankak zabal zabalik
entzun eta entzun gustatzen zaio
Nik edozer esaten diot
zer esango diot bada?
baina gehiegi da era batera
bultz eta hitz egitea
eta sarritan ez dakit zer esan
eta orduan ia ia kontatu nion
Beltxena ere
baina ez nion kontatu
eta ez diot kontatuko
hemeretzi urte ditunean ere
zeren abereek honela
ibili behar badute
pertsonak nola
ibiliko ote

# HAURTZAROTIK BORTU MUTURRERA

## I. Haurtzarotik

Hautzaroa aspaldi utzi nuen
baina nola bihotza baitut han
kontatuko dut zer gertatu zitzaidan
Ene ilusio askotarik handiena
txori bat eskuratzea zen
txori bat edozein txori
hegan zebilen edozein
Gardantxiloak urtero egiten zuen habia
etxapeko madari puntan
Ume haik maite nituen
baina nik ama bera nahi nuen
bizirik eta éskuetan
Anitz habia nituen urtero
anitz habia eta habiakada
baina nik habiagileak nahi nituen
bizirik eta eskuetan

Negua gora begira pasatzen nuen
pasatzen ziren txoriei begira
Zuhaitz adarrei inbidia nien
inbidia eta gorrotoa
haietan txoriak kokatzen zirelako
Esku bat pozik ebakiko nukeen
eta madari puntan utzi
udaberriaren atarian
baina ez nuen adorerik
eta damu naiz
eta amorrua dut
ilusio batek gehiago balio baitu
nire bi eskuek baino
Jainkoari haserrez galdatzen nion
nola egin zituen hain gauza politak
eta hain iheskoiak
Txoriei hots egiten nien
laguna nintzela
ez eskapatzeko
ea zer egitea nahi zuten
ez niela ezer egingo erakusteko
eskuetan eduki bakarrik
sudur puntan ukitu
papartxoa haztatu
isasñoa kilikatu
nahi zutena jaten eman
eta nahi zutenean
eskapatzen utzi
Zer nahi zuten bada gehiago?
Baina ez zidan inork kasurik egiten
eta haurtzaroa joan zitzaidan
txori bizi bat eskuratu gabe

Hilik eduki nituen
baina nik bizirik nahi
bizirik ere harrapatu nituen
baina harrapatu
derrigorrez
beste erremediorik ez zutelako
eta nik libreki nahi nituen
etorririk, ez harrapaturik
eta horrek hesteak erretzen zizkidan
eta dena alferrik zela ikusirik
txonta-bat komunean jarein nuen
leihoa hertsirik eta ni atezain
katuari hots egin nion
oraintxe ikusiko dun laguna zer den
Hango erpe hotsa eta luma jarioa!
Ehizaketa hilotz kontenplatu nuen
ene begiei sekula egin diedan
biolentziarik gogorrenez
On egin!
Eta haurtzaroa joan zitzaidan
txori bizi bat eskuratu gabe
Bihotzari galdatzen nion
zergatik hain maite behar zituen
ihes egiten bakarrik zekitenak
Birigarro bat ikusi nuen harri gainean
joan nintzaion eta geldi zegoen
eta bizirik zegoen
eta ez zuen eskapatzen
Eskua luzatu nion
eta bertara etorri zitzaidan
bihotza oldartu zitzaidan
eta arnasa geratu

Han nuen ene ilusioa esku batean
baina bestea bildur zen ukitzen
zeren eta zeren
hainbeste hutsen ondoren
iheslariak bakarrik maitatzen nenkien
eta hantxe arnasa utziko nukeen
amaren eskolarako deiak
iratzartu ez banindu
Eta ene haurtzaroa ilusiorik handiena
bete gabe joan zen
Ez zen bada ilusio garestia
dena baitzen inguruan txoria
baina ene ilusiorik handiena zen
eta ene haurtzaroa
ilusiorik handiena
bete gabe joan zen
Gaur ere txori bat
bizirik eta libreki
eskuetan edukitzeagatik
iraultza erdi emango nuke
beranduegi ordea
ilusioa ez baita loratzen
desilusioaren arbolan

## II. Bortu muturrera

Joan zitunan urteak
eta hi etorri hintzaidan
ametsak edo itzarpenak
eramaniko birigarroa
Behar bada hik nahiago dun usoa deitzea
baina niri birigarroa falta ziaidan
Joan nintzainan eta ez huen eskapatzen
eta bizirik hengoen eta libreki
eta ukitzen uzten hidan
eta ez huen eskapatzen
eta ukitzen hindudan
itsasoaz handiko eskuekin
Ez nionan katuari deitu
ez baithuen eskapatzen
eta han gieundenan bortu muturrean
faroaren orpoan itsasoaren golkoan
eta han niengonan ni
hire eta itsasoaren artean
ur tristez inguraturik

alde guztietarik
hiretik izan ezik
Ez dinat esango ezin nuela sinetsi
eta horrelako tentelkeriarik
Banienkinan non nengoen
non hengoen eta non geunden
bortu muturrean
faroaren orpoan
itsasoaren golkoan
Banienkinan non nengoen eta zertan
baina ez hindudan gehiegi herstutzen
eskapatu nahi bahuen ere
baina ez huen eskapatzen
eta han niengona ni
esku batekin atxikia hiri
eta bestearekin ilusioari
Euria ari zunan, gogoratzen haiza?
Nola gogoratuko haiz ordea
ez baithintzen enteratu ere?
Euriak blai blai egin gintinan
eta lehortzea lantsuago izan zunan
bustitzea baino
bai alajaina!
halabaina
noiz behinka asaldurak kolpatzen hinduen
Nori egiten genionan gaitzik?
Nork esan behar zigunan deusik
inor tristarazi gabe bageunden pozik?
Hain gauza ona eta merkea
ugaria eta geurea
Bai alajaina!
halabaina

noiz behinka mueile traidore batek
burua disparatzen zinan
Zer izan duk hori?
Nor izan duk hori?
Lapurretan bageunden bezala
konspiratzen bageunden bezala
Ez dun ezer ez dun inor
olatu hotsa faroaren dzistada
katu marraua frenazo bat ezer ez
Bakarrik giauden
bakar bakarrik giauden
halabaina
nik ere banienkinan
nik ere sentitzen ninan
ez geundela bakarrik
presentzia traidore batez inguraturik baizik
Eibarko harmategiek akabatu zizkinaten sorginak
baina beti bezala makalenak
lehen ere juxtuan bizi zirenak
Sorgin ama ordea
bizirik geratu zunan
sorgina nagusiak ordea
bizirik ziraun gordea
kanpai hotsaren ostean
larruaren laugarren mintzean
ohearen bostgarren hankan
gizartearen betertzean
haur sehasken kulunkan
ohitura sainduen eforruan
kanpoaren barruan
barruaren kanpoan
eta hire golkoan

Hain gauza ona eta merkea
ugaria eta geurea

Ez diakinat hau
birigarroa zen
gertatua zaidan
ala ametsa den
baina ametsa bazen
gustatuko litziaidakeen
gertatzea hirekin
hirekin ezin bada
hi bezalako batekin

# ARRANTZA FILOSOFIKOAK

## I. Izan ala ez izan

Handiagotu nintzenean
arima hilezkorraren zera
irakatsi zidaten
ohiturik baikeunden
edozer sinesten
Beste gauzarik gehienak ez bezala
pozik hartu nuen berri hura
zeren beraz
etxe eta etxeko
txakur abere
Bel hura batez ere
bildots zaldi zuhaitz landare
ez zeuden betiko joanak
Noizbait nonbait nolabait
topatuko genuen elkar
berriro ere

Zientziak zioen
herbestean bereziki ikasiek zioten
Belen mutur arreak eta oin nabarrak
nonnahi ikusten nituen
bizi zen Bel bizi zen
lehenen eduki eta
lehenen galdu nuen laguna
harik eta harik eta
uso beltzen ariketa
entzun arte jakin arte
arima pertsonena bakarrik dela
animaliena
haitzurkada bat eman
eta bukatzen dela bertan
beraz nire lagun Bel
beraz esne epela ezkutuan eramaten
nion musker berde hura
beraz beraz horixe
edonork dakiena
edo inork ez dakiena
jo eta garbi
hitz batez
ezer ez
Nola zitekeen ordea
nire arima hilezkor
eta Bel ez, baina Bel ez
bera izanik nire arima erdi?
Mintza gaitezen argi
badakit pertsonok eta abereak
diferenteak garela
nahiz eta zertan ez jakin
Nik jasan ezin nuena

munduaz beste etorkizun bat
asmatzea gizonari
zeren zertaz eginik gaude bada
txakurrez mendiz aberez munduz
ez bada?

- Emak hilkor haizela
  edozein mando bezela
  Alferrik hilezkor haizela sinestea
  hire gogoak ez baitu
  hilkortasunik hilezkortuko
- Eguzkia baino argiago
- Eman hilezkor haizela
  lantzean mando bat bezela
  Alferrik hilkor haizela sinestea
  hire gogoak ez baitu
  hilezkortasunik hilkortuko
- Baina horrela izanik
  komeni da oraindanik
- Horrela izanik
  gero diagok astia
  zer egin pentsatzeko
  Bagara bagaituk
  ez bagara ez gaituk
- Astoak ere badaki hori
- Puntu horretan konforme nauk
  astoak dakienarekin

Ni ez naiz edo ez nuke izan nahi
ez razionalista ez panteista
ez morokilista ez ezer
Hauk guzti hauk
filosofiak ekarritako kinkailak dira
Edonork galda lezake

hemendik hamar milioi urtetako
argira dagoen galaxia batetako
milioietariko izar baten
planeta batetako
satelite batetako
irla batetako
mendi batetako
harizti batetako
tantai baten
adarretarik batetako
okil habian
zenbat arraultze dauden
Nik ez diot okil habia hartan
ez dagoela ez badagoela arraultzerik
nire txoriburuak jakiteko baino
harago dagoela baizik
Gure ondorengoek akaso ilobek
jakin ahal izango dute
Barregarri dena
oraindik esateko
zuhaitzetik jatsi berri den
pellopitekoa
buztana sasian gal berri duen
bizangoa
adimenduaren haztamuketan
abiatu baizik egin ez den
kainabera izorratua
''azken arrazoien'' galdez hastea
Nik Bel maite nuen
Belek maite ninduen
hau badakit
beste gauza asko ere badakit

gizonaz gizartez munduaz
Ez naiz ezer ez dakidala
bakarrik dakidala
esateko bezain faltsoa
baina erantzumena zorrozten ez zaidaino
ahalegintzen naiz galdamena kamusten

Unamunok bizitzarik gehiena
hilezkortasunari bueltaka
eman zuela entzutean
ipurditik barre egiteko
gogoak ematen du

## II. Zenbat izar

- Zenbat izar daude hor goian ama?
- Asko
- Asko zenbat?
- Ez hezak ganora gabeko galderarik egin
- Baina nik jakin nahi dut ama
- Joan bertara eta ikus
- Esan ama, zenbat izar daude hor goian?
- Hori dakiena isilik diagok
- Eta zergatik dago isilik hori dakiena?
- Hi bezalako berritsuek
  isilik egoten ikas dezaten

Gure amarentzat ez zen galdera ganora gabea
inportantziarik ez zeukana
Harentzat izarrak inportanteak ziren
Gure ama ernega arazten zuena
ezin erantzuteko galderak egitea
Niri asko gustatzen zitzaidan
amarekin dematzea
nahiz eta inoiz
kokoteko bat irabazi

- Egunen batez ahoa hertsiko diat betiko
- Baina nik orduan belarrietatik hitz egingo
- Baba handi bana sartuko diat bakoitzean
- Baina nik orduan sudurretatik hitz egingo
- Josi egingo dizkiat bi sudurtzuloak
- Baina nik orduan ziletik ekingo
- Zipotz bat sartuko zioat

eta hala gorputzeko zulo guztiak hertsi arte
baina nola orduan leher
egin behar baita nondikbait
handixe hasiko nintzen berriro
galdera ganoragabeak egiten
Beti pentsatu ukan dut
pentsalari handia zela
gure ama

## III. Hitzen subasta

Ibili eta ibili
inoiz egon gabeko hirira heldu nintzen
Zurrunbilo haundi batek
enparantza nagusira eraman ninduen
Kiosko bakoitzeko bozgorailuek
zenbakiak kantatzen zituzten
enkanteak gora eta gora
eztarriek orroe eta orroe
belarri metalezkoak ere mintzeraino
Sakeleko diruak eskuztatu
eta jokatzea erabakirik
kioskorik kiosko
zer diok morrosko
ibili ondoren
ahoa ondo hertsi behar
hortzak ez erortzeko
harriduraren harriduraz
eta atzeko zulotik irtengo ziratekeen
han ere prekauzioak hartu ez banitu

Jenero gabeko subasta
inork ez zedukan ezer
dena zen hitz jokoa
dena garrasi trukea

- Baina zer subastatzen duzue hemen?
- Zer subastatzen dugun?
- Zer jenero nahi dut esan
  oilo oilasko aker adar
  luma edo zeozer
- Hau subasta duk, ez azoka

Jende hau burutik eta buztanetik diagok
Nire zentzu harritua eta harrikatua
ez zen argitasun gehiagora heltzen
Kantomasklitoteles eta bere sozio
Platogustinhauer-en barkamenez

## IV. Euskara garbia eta freskoa

Euskara da Marilarru bat
denok izorratzen duguna
eta Marioilar bat
denok izorratzen gaituena
Euskara da makila bat
beharren dugunean
suge bihurtzen zaiguna
eta zast! egiok hatz orain
Euskara da hizkuntza bat
noizbait inori zorrik
izango ez diona
nahiz eta bitartean
gibelak erre arazi

Baina bai atsegina
atseginik bada munduan
gauzetara zuzen doan
hizkuntzaz mintzatzea

Ura haizea eta hizkuntza
garbiak eta freskoak
emakumeak edonolakoak
gustatzen zaizkit
Hitzak ez zaizkit axola
hizkuntza baizik
Zientzia zentzudunek
haztamuka korritzen dute
oinez ikas berriek bezala
baina buruhandiek
zientzia orokor bat behar dute
lehen galdera nagusiei
azken erantzunak ematekoa
Barregarria
Platano azal bat dematzen
ari diren tximinoei
erlatibitatea galdatzea
Negargarria
Pentsamena da txakur eme bat
bere buruaz erditzen dena
eta bere ahalaz gorako umeak
munstrokumeak egin ere
Harrigarria
Zorotasunaren lurretan gaude
Gizakiok bakarrik daukagu
ahalmen harrigarri hori
Barregarria negargarria
Zorotasunak mundu guztia kutsatu du
sustraiak ihartzeraino
zentzuak ez igartzeraino

Zorionez oraindik
noiz arte ez dakit
libre dago euskara
zorotasun batzutatik

Euskara
garbia eta freskoa nahi dut
Hitzak ez zaizkit axola
hizkuntza baizik

Emakumeak edonolakoak
baina euskara
garbia eta freskoa
dakiena bada
lan handi gabe
maiteminduko nau

# ALDAMIOKO DISKURTSOA

Jaunen jaunok eta andreen andreok: Badirudi ez duzuela sekula aldamiorik ikusi ez orangutanik trapezioan. Zergatik egon behar du aldamioak beti hormari datxekola edo zergatik izan behar du aldamioak beti bizkarkoi kondenatu bat edo eraman-ekarriko tramankulu hautseztatu bat? Tramankulu hau bere joputasun genetikotik askatzea erabaki dut mundu guztiak jakin dezan aldamioak ere bere nortasuna duela beti alkahueterian ibili gabe. Kaiola batzu egin dizkizuete eta hor bizi zarete irudimena zer den ere ahantzirik baina ni hementxe dilindatuko naiz neure aldamioan zeren Aldamioteles-ek zioen bezala aldamioa ez baita aldamenean ipinteko ahal denean ezin dena egiteko baizik baina herri honetan zentzua itsulapikoan dago eta ugazabari baimena eskatu behar ateratzeko eta nola ugazabak ez duen sekula ezer ateratzeko baimenik ematen, disekaturik akabatuko zarete zuen idortasun anemikoan. Zuek uste duzue munduko simetria semaforoetan dagoela edo kaleak inork ezagutzen ez dituen izenak edukitzean eta ondo uste duzue zeren zuen buruekin ez baitago besterik uste izaterik eta

horra ezer ustegaberik ikustean ipurdiak bezalako begiak irekitzen dituzuela gizona aldamiotik erortzeko jaio balitz bezala. Emakumeak aldamioan erdituko balira, beste koefiziente mentalik luke jenealogia endakatu honek zeren aldamioan behintzat jaio berriek haize freskoa hartuko bailukete mundu hermetiko honetan hain beharrezkoa noski, nahiz eta hor ketan ari den paper-ola horrek uzker-ola dirudien eta honela ez dago hesteak garbi edukitzerik lantzean bonbilkada bat hustu ezik eta nola herri berri eta produktibo hauetan ez baitute zuhaitzik ere utzi nahi baina nola nik norabait jaitsi-igona behar baitut horizontalki ibiltzeko, aldamio hauxe egin nuen bart udaletxeko trastegelan ohol zahar batzu ohosturik eta datorren urteko prozesioan aterako duten Ama Doloretakoari iltze pila bat kendurik. Ez zuen Ama gaixoak atseden makala hartu nahiz eta bi besoak eta bular erdi erori, baina ez nago damuturik zeren banuen gogoa zibilizazio mogoliko honi beste ikuspegi batetatik begiratzeko. Ikusten duzue kale bete jende katabut baten atzetik eta normal iruditzen zaizue, ikusten duzue kamino bete laugurpil, elkarri etzetik ematen eta normal iruditzen zaizue, ikusten duzue mostradore bete bizango aulki lauzangoetan bi zangoak zintzilik eta normal iruditzen zaizue, ikusten duzue ikusten nauzue aldamio puntan eta zoroetxeaz oroitzen zarete. Zer nahi duzue bada, magnetofoi bat hartu eta atzeko putz hotsak edo hots puzkor atzekoiak grabatzea? Ala kanpandorrera igon eta hamabiak eta hamar edo hamabi amari jotzea erloju izorrantea? Ala kanposaindura jaitsi eta iraganeko hezurrekin etorkizuneko txalaparta jotzea? Ala bat, ala bi, ala bi bonba jartzea ea ernatzen zareten? Hiri honetako kamustasunaren anhidridoari alergia diot eta zerbait egin behar zuen larru lurrunkoien kutsaduratik libratzeko, baina nola aldamio eta guzti ere gizabeltegi horretatik hurbilegi nagoen, grabitatearen kontrako antidoto batzu hartu behar ditut, Antidoto

Lehenengoa, Antidoto Bigarrena, Antidoto Hirugarrena, Antidoto Jainkoakdakiengarrena eta Egiptoko Faraoiteria guztia ea aldamio hau desmunduraino piramidatzen dudan hiltzekotan ere asfixiaz hil nadin eta ez kutsaduraz, zeren, jaundreok, paper-ola horiek baino kirats okagarriagorik botatzen dute balkoi banderatuek, gorputz kosmetikoek, aharrausi ugazabatuek, diskurtso garatuek, dolare dolartuek, oilarren pekatuek eta txakurren katuek, mahai saindua apartaturik, jeneralen garaun jeloskorrak eta kardenalen garau hilezkorrak zartaginetik bertatik eraman dizkidatenak, zeren hemen lau hanka dituen edozein piztiakondok edo Kondepiztiak uste baitu edozer harrapatzeko eskubidea daukala buztan bat daukalako, nahiz eta historiaren loriarako aitortu beharra egon bi hankakoek bapo gainditu dutela horretan genealogia orain ginekologoek edo konejologoek esan diezaguten ezetz, berek ez dutela proliferamen lapur horren errurik, baina niri bart ere aldamio bat ohostu didate eta parte ematerakoan hara non aurkitzen dudan epaitegian ene aldamiotxoa, ez omen bainuen luxuzko zergarik ordaindu eta orain esaidazue zer ordaintzen duten lur, itsaso eta aireko jaun bidaztiek giza narraztien kontu korrituak eramateagatik eta bizi lizentziak ekartzeagatik zeren bizirik bagaude hiltzen ez gaituztelako da eta hiltzen ez bagaituzte bizirik behar gaituztelako, hilik ala bizirik? hilik ez, bizirik baizik, bizirik behar dizkiagu bizi garen bezala biziko bagara, beraz lasai mutilak, ez gaituzte denok hilko zeren denok hilda nola hiltzen segitu? Odola errentakor ez bada ez da odola, baina izerdia beti da errentakor eta horregatik ugazabandrea gabi batez erditu da goizaldean gruba nagusiak tiraturik ugazabak altzeiruzko saldaz izorratu zuelako, lan biribila, hor alferrik dituk pilulak eta Aita Sainduaren kukurrukuak. Gaur eguerdian izango da bataio blindatua Andre Maria Sortzez Garbiaren Elizan gonbidaturik daudela nortasun kapelatuak eta Izpiritu Sainduaren senitarte

guztia, baita herriko behartsuak ere gonbidaturik daude elizkizun ondoko harrapailora, baina iso, ordenaz eta eskandalu gabe, botatzen zaizuena irribarrez jasorik eta zuek denak bati soberatzen zaiona harrapaka ari zareten bitartean nik aldamio hau Bidasoan jarriko dut Hegoa eta Iparra ene birikietan gurutza daitezen zeren nork esan dizue gutti garela, ttikiak garela? Askatasuna ez da neurtzen azaleraz, zakoneraz baizik eta aldamiante bat ametitzeko kapaz ez bazarete, zoazte hilargira desdititzera ez baituzue zapaltzen duzuen hautik merezi, ai hau herria, herria, baina neurea, neurea, neu ere, neu ere bataiora noa ez baita gizona ogi hutsez bizi, ogi bitartekoa ere behar da zeren zer balio du munduan irabazteak aldamioa galduz gero, eta orduan hobe zait berton geratzea hau ere ohostu ez diezadaten. Okupatzen ditudan lur aireen errentarik pagatu behar bada, pagatuko dut baina nik aldamioan nahi dut, ene aldamiotxo, izaki esklaboa, zerena eta hormena, badiakiat bai zer den hormen atxikidura, ene aldamiotxo, maitatzera heldu natzaik, heldu natzain, beti hormaren kontra ikusi baitaut, hi askaturik askeago sentitzen nauk, sentitzen naun, eta ez begira ditugun aurpegi postfabrikatu horik bezala, haragi jelatuzko bipodeak, non ipini hantxe erortzekoak, bai dela tristea mundua barrutik hara begiraturik, baina bai polita ere aldamio aldamenkoi batetatik begiraturik, gertatzen dena bat pozik dagoela igartzen diotenean, zorotzat daramatela edo okerrago dena atxiloturik daramatela ordenu publikoa desordenatzeagatik eta hauk eta horik eta besteak horrela direla banoa neure aldamioan beste leku batera.

# ZER GERTATZEN DA IRUIÑEAN *

## I. San Fermin etengabeak

Iruiñera heldu naiz
eta galdatzean
zer gertatzen den
kalean
San Ferminak esan didate
San Ferminak etengabe
erresuma zaharrean
Nola baina hain goiz
nola hain berandu?
Lehengo San Ferminak
uztailaren zazpian
zazpi uztailetan
oraingoak
uztailetik uztailera

* *1.973-eko udaberrian greba historiko bat izan zen Iruiñean Nafarroa airean jarri zuena. Hain zuzen hura bukatu eta San Ferminak hasten ziren.*

uztailetan zehar
  "Badiatozak badiatozak
   goiko kaletik beheko kalera
   badiatozak badiatozak
   goiko kaletik zezenak"

Hau duk hiria
hau duk jendea
hauxe duk hauxe
bila nentorrena
uhu eta aha
kaleak barrena

  "Zezenak irten arkupetik
   kakak ipurdiko zulotik
   triauskititun triauskititun
   jendeen artetik"

Bizitza izanik
hain urri laburra
duen gatz apurra
kentzen bazaio
hobe duk ez jaio

  "Zezenak dira
   bel-beltzak dira
   harrapatzen bazaitu
   harrapatzen bazaitu
   bertan bertan hilko zaitu"

Jende artean sartzen naiz
galdu naiz
eta ez naiz ni
jendea baizik
eta jendea ez da gu
uholdea baizik
Uhu eta aha
hau duk hau sasoia
igelek arrazoia

"Badiatozak badiatozak..."

Non datoz baina zezenak
ikustera etorri naizenak?

Bukatu zuan galdera garaia!
Hago hor eta laster
ikusiko dituk

Zezenak nahi ditut
zezenak nahi
aaaiii!
Adarkada edo ez dakit
zerkada batek
airez aire
jaurtiki nau
zer duk hau
nire saihets bat
teilatu zaharrera
erori da
katu beltzak
ai ama

darama
harrapa hezak hori!
beste saihetsak beren
lekuan ote dauden
gutti gora behera bederen
arduratan naizela
haizea urrikaldu da nitaz
eta hartu nau bere bizkar
ez nadin berriro
adartegira eror
Zer gertatzen da Iruiñean?
Muturrak ferekatuz
isi eta ikus
diost haizeak
isi eta entzun
entzun eta ikus
Ikusten dut ikusten
hiri bete jende
zezenen mende
zezenen aurka
Entzuten dut entzuten
hiri bete orroa
nola Nafarroa
adarkatzen duten
Zer gertatzen da Iruiñean
arratoiek ere txilioka
hauts dezaten besta
satorrak ere uholka
daitezen manifesta
haitzurren kontra?
Isi eta iso
entzun eta ikus

Iruinear langileak
eskubide guztien
jabe bakarrak
jabetasun guztiaren
eskubidedun bakarrak
makinak eta labeak
eulien eta herdoilaren
kontura utzirik
haizearen bideetatik
abiatu dira
harriz eta eztarriz
aldarrika:
Non dira zezenak
esplotatzen gaituztenak?
"Badiatozak badiatozak
goiko kaletik beheko kalera"
Nork debeka diezaguke
irtetea kalerik kale
geurea bada hiria
alderik alde

Badiatozak badiatozak
kuartelkadak autobuskadak
hiri modernoetako
hondamendi plagak:
zertarako dira fusilak
tiratzeko ez bada
zertarako makilak
jotzeko ez bada?
Jo eta tira mutilak
biziak eta hilak

Hiri honi hortz eta guzti
irents erazi behar zaio
bere errebeldia berriro

Kanposainduko hezurrak
txitak bezala pilatu dira
elkarren dardaraz defenditzeko
Baina biziek
trumoia buruzagi
aurrea damaiote
ifernikolen inbasioari
Zertarako dira harriak
tiratzeko ez bada
zertarako ukabilak
jotzeko ez bada?
Jo eta tira mutilak
hiri esplotatu honek
errementa dezan norabait
Eman dizuegu izerdia
eskatu diguzue larrua
eman larrua
eskatu haragia
eman dizuegu haragia
geratu zaigu abotsa
eta abotsari lepoa
bihurtu diozue
Zertarako dira harriak
zertarako ukabilak
jo eta tira mutilak
hiri esplotatu honek
errementa dezan noizbait

Iruiñear andreek
urteetan zehar
komoda zaharrean
gorderik edukiriko
amorru urdinbera
baldeka bota dute
balkoietatik behera
eta hona orain
abotsarekin batera
dena birgeuretzea
erabaki dugula
haragia eta bere larrua
izerdia eta bere balioa
Ikusi dut ikusi
hiri bete jende
zezenen mende
zezenen aurka
Entzun dut entzun
hiri bete orroa
nola Nafarroa
adarkatu duten
Iruiñear seme-alabek
ezagutu dute zezena
Picassorena
baina kostatuko zaio
Gernika bezain erraz
apurtzea arras
hain erraz
hain arras
Iruiñea

Orain lagun haize
bila dezagun nire
saihetsa
miatzen ari den
katu beltza
zeren nahiz eta badakidan
saihets baten gabea
ez dela hain grabea
nahi nuke gera lekidan
bat behintzat
besteak galdutakoan
Iruiñeako SanSerminetan
San Fermin etengabeetan

## II. Heren-sugetik heren-zerrira

Heren-sugeak
leize ahoraino arrastatu
eta nagiak deskiribiltzen ditu
erresuma zaharrerantz
Laster zabalduko ditu zazpi ahoak
eta egingo orroe zazpikoitz bat
ekar diezaioten gosaritzat
herriko alabarik hautatuena
Bai haragi fin zalea
alfertzarra alaena!
Leizearen sabel egosiak
aurreko digestioko
bafada urdinduak
korrokatzen dizkio haizeari
eta haizeak
Nafarroan zehar
hedatu behar
alaba xarmagarrien
zori iheskaitza:
"Hona kiratsa
hire ahizparena
hire hasperena"

Atera ziren nafarrak
basorik baso leizerik leize
etxeko zakur eta
kanpoko erlijio
guztiekin
baina ezin
heren-sugea akabatu
Atera ziren nafarrak
beren kontzientzietan zehar
etxeko zakurrik
ez kanpoko erlijiorik
gabe
eta han
derrotatu zuten behingoz
eta desburutu betiko
piztia zazpikoitza
giza-jale asekaitza
Geureak ditugu basoak
geureak kontzientziak
kontzientzietako basoak
eta basoetako alabak

Baina Euskal Herria ere
beste herrien
berdinegia izaki
beren alaba gazteak
eta ardo zaharrak
elkarri eskaini bitartean
heren-sugearen hilobi gainean
heren-zerria jaio zen hirian
zazpi burukoa
zazpina urdailez

Jaio zen jaio
hasi zen hazten
presarik gabe
gizendu ahala itxaronez
nafar menditarrek
nafar ibartarrek
utz zezaten astiro astiro
beren askatasun sakabanatua
pila zitezen poliki poliki
bere gorta inguruan
hirian Iruiñean
Haizeak narama
haizeak narabil
heren-zerriaren
gortarik gorta
Ikusten dizkiot haginak
altzeiruz eginak
muturrak eta apatxak
hauts-ezinez blindatuak
ikusten dizkiot begiak
tren suztatuak sar irtenka
bet-hobietako tuneletan
Ireki ditu zazpi ahoak
eta eztarri leizeetatik zehar
agiri zaizkio ozeanoak
bezalako sabeltzarrak
Iruiñeako eta Nafarroako
kaleetan harrapaturiko
semeak eta alabak
botatzen dizkiote askara
eta muturkatzen heren-zerriak
erremolatxak bezala

hezurrek krask
haragiak zarrast
aska alboen kontra:
Iruiñeako langileak
eskubide guztien jabeak
jabetasun guztiaren
eskubidedunak
Baina ez bide dio
janak on egin
petrolioa baitario
belarrietatik
ultzeratu berri zaion
urdailtzarren batetik

Ez diagu ez diagu
heren-zerri madarikatu
gure bizipidea bakarrik
hire hilpidea baizik
eskatzen
gure bizipidearen ez-hilpidea
hire hilpidea
Arrazoiz orroaka dihardukak
ez direla gure burrukak.
disziplinatuak
ardi arranek ere
politika jotzen dutela
enara errugabeek ere
subertsioa dakartela
Ez diagu ez diagu
heren-zerri madarikatu
boltsa ala bizia bakarrik
boltsa eta bizia baizik

eskatzen
boltsa eta bizia
bizia batez ere
hire hilpidea
hire hesteetan sarturik
heren-sugeari eramateko
lukainka gizenak
alaba ederren ordez
eta bide batez
kontzientziak bakez
eduki ditzagun
Nola lasai lo egin
krokodilo bat alboan
duenak ohean
nahiz eta jakin
loa bera bezain
mantso egongo dela?
Ez diagu heren-zerri
ez diagu hirekin
koesistentzia baketsurik
hire esistentzia borratu arte
ametsetatik ere

Iruiñear langileek
badakite heren-zerria
nor den eta non den
eta ez dela hilko
berez
haren askazainak
asko eta harmaturik
haren janari emaleak
aska beretik jaleak
baitira

beraz
heren-zerria bizi dela
eta biziko oraindik
gizonen izana
lana
janez
Baina Iruiñear langileei
ez die inork kenduko
heren-zerriaren digestiorik
onena hondatzearen
satisfaziorik
eta esperantzarik
heren-zerria ehorzteko
heren-sugearen ondoan

## III. Etorkizuna

Maite ditut maite
Nafarroako basoak
tantaidi freskoak
gerizpe urrunak
nire gogoaren
ahaide hurbilak
Zuhaitz eta haizkora usaina
somatzen dut oraindik
zilaren ebakiduran
Nahi nuke baina ezin dut
haizkorakada hura
zikatriza dakidan
Hiltzen naizenean
hilko naizen bezala
ehortz nazazue
aurreragoko zereginik
ez badaukazue
zuhaitz baten marroan
haritzaren barruan

Baina bizi gareino
bizi garen bezala
sasoia da zuhaitzetik
emantzipatzeko
Nafarroaren etorkizuna
Iruiñean
Euskal Herriarena
Hirian
jokatzen da
etorkizun guztiak
guztien etorkizunak
jokatzen diren
leku bakarrean
LANEAN

# ENE JENERALARI

Hor zautza ene Jeneral
hemen nauzu ene Jeneral
Presente ene Jeneral
zutik ene Jeneral
baina hor zautza ene Jeneral
zapaldu zenuen lurrak zapaldua
Soldadu honek ez daki zertarako bizi den
zuretzat bizi baitzen
Nola joan zatzaizkigu
nola utzi gaituzu
etorkizun kolokaren mende?
Nik aisa iruditzen zintudan
zu mundu gabe
baina ez mundua zu gabe
Zurekin denbora mugatuak
betikotasun kontzentratua zirudien
zuk bihurtu zenion odolari bere hozberoa
zuk bihurtu zenion izpirituari bere haragia

zuk Jainkoari bere ahalguztiaren kontzientzia
zuk gizonari bere jaiotz-heriotzen batasuna
Eguzkiak goizero jotzen zizun leihoa
Gora ene Jeneral!
eta eguerdiro zure ataritik pasatzean
aurrerako baimena eskatzen zizun
eta behin geldi hor agindu zenionean
erresuma guztia belaunikatu zen
mirakuilu nazionalaren aurrean
Historia bere giltzetatik irtenda zebilenean
zuk itzuli zenuen bere zentramendu ontologikora
lehena eta geroa desuztarturik zebiltzanean
zuk berbildu zenituen orainaren hezurdura katolikoan
Jaioko dira txoriak, hilko dira elefanteak
biztuko dira eskeletoak, itzaliko dira bolkanak
baina zure izenik ez da ezabatuko
bizien oroimenetik
ez hilen hasperenetik
Zu hilobiratzean
krokodilo ahoa bezala ireki zen lurra
harriturik bere materiaz beste izaki bat
dijeritu behar zuela
zeren zu, hain haundien haundi hori
ez zintezkeen lurtarron jatorrikoa izan
naturaren extasisen batek sortua baizik
eta hori da hain zuzen injustizia nabarbena
zazpi ahoko ezpataz derrotatu zenuena
nola ezlurtarra izanik
lurrak irentsi zaituen
zu, hain haundien haundiago hori
Zure soldadua ninduzun eta nauzu
zeren zurekin hiltzea eta erhatea

atsegin beraren atze aintzinak ziren
Beti egongo dira arranoen hegada
pozoindu nahiko narraztiak
beti egongo dira ostadar errugabea ere
horzkatu nahiko mihiztoak
baina izarrek badakite zure erresuman
lasai zintzilika zitezkeela
inora erortzeko bildur gabe
Zuk berbiztu zenuen bakea
mugimenduaren agoniatik
Zure agindupean ogia ogia zen
eta ez bekokian harrikada bat
kaleak kaleak ziren
eta ez haize desamatuen iraulbideak
Badira diotenak
zure arnasari hil usaina zeriola
zure bakea kanposainduzkoa zela
baina ez dakite nik adina
zer amilmenetik altxatu zenuen aberria
Pertsonok eta piztiak
elkar ezin berezirik genbiltzanean
zu jaiki zinen eta lekutasuna ber-ezarri
gizonak hemen, zerriak hor
arimak han, igelak harago
firmerik denok
bai ene Jeneral
eta horrela nahasmendua zehazmendu bilakatu zen
eta izorramendua ordenamendu
Utz iraka gariarekin hazten
baina hark ez zekien politikarik
eta nik badakit
zuk hil beharrez hil zenituenak

bestela ere goseak hilko zituela
eta zuri eskerrak bizi garenok
haitzak esnetan eta esneak bitsetan
ikusi ditugu zuri eskerrak
eskuinean joritasuna eta ezkerrean jareintasuna
zenituen Napojotepraisku horri eskerrak
Gaur trenak doaz eta datoz
zure bortzegiek irekitako bideetatik
tranbiak atzera aurrera dabiltza
zure muturrek zulaturiko katakunbetan
tximiniak ke bolbolka ari dira
zure plomuak berzentraturiko zerurantz
Zugatik egin da dena
eta zu gabe ez da ezer egin
baina zureak ere egin du
eta denonak egin ez dezan
zautza hor eta har atseden merezia
iraganaren zerraldoi eta etorkizunaren sokaboi horrek
saimotzen harakin eta muskerren artzain horrek
erosioaren harresi eta fosilmenduaren gaztelu horrek
itomenaren zirimol eta nazkamenaren bemol horrek
zautza hor eta zaude
sekulorun sekularen sekularioan
Jeneralun Jeneralen Jeneraltasun hori




* *Doinu hau neuk egina da.*

1. Egunez eta gauez entzuten
dugun haizearen hotsa
batzutan bare bestetan bizi
gaur leuna bihar zorrotza
Hala da edo hala behar du
bertsolarien abotsa
parean zer den hura kantatzen
bizitza nahiz heriotza
suak burdina bezala landuz
bertsozaleen bihotza

2. Mendirik mendi ahorik aho
hor dator betsolaritza
herentzi horri mendez aurrerantz
tiratu nahirik gabiltza
Nola haizkorak kolperik kolpe
ezpaltzen duen haritza
hala da edo hala behar du
bertsolariaren hitza
osorik hautsiz osorik bilduz
Euskal Herriko bizitza

3. Bertsolariak herri bizia
dauka beti bere aurrez
eta han bera hortzen ertzetik
hitzak atera beharrez
Behin ariko da humore onez
behin amorruzko indarrez
negargileak barrez jarririk
barregileak negarrez
hau eta dena nahi dugu baina
ez da uste bezain errez

4. Bertsolaritzan izen bikainik
bada historian zehar
aipa dezagun Etxahun handia
aipa dezagun Xenpelar
Oraindik ere bizirik gaude
nahiz sarri egon hiltzear
lehena joan zen gaurkoa ere
badoa eta zer bihar
etorkizuna hori da dena
besterik ez dugu behar

5. Etorkizuna iragartzen du
laino arteko izarrak
etorkizuna kolpeka eskatzen
lantegiko mailu zaharrak
Bertsolariak berdin jo behar
ditu hegoa iparrak
sustraiak zakon lehenean baina
geroan luze adarrak
kanta dezagun egun berrirantz
nola goizero oilarrak







* *Bertso hauk bizkaieraz egin nituen eta ala uzten ditut, besteak beste oso zaila baita euskara batura egokitzea bertso batzu berriro egin edo asko aldatu ezik. Horrez gainera badira gaur sartuko ez nituzkeen "lizentziak" edo komenentzi jokoak ere hitzen amaieretan, laburtzapenetan eta abar. "Sartuko ez nituzkeenak" diot bertso jarrietan. Beste gauza bat da bertso improbisatuetan.*

1. Euskal Herritik aparte
mila legua bitarte
esku ta hanka loturik preso
Zamoran gauzkate
Pentsaturik zenbat urte
behar dogun hemen bete
pazientzia hartu beharko
libre utzi arte

2. Nahizta kriminal ez izan
kaiola txorien gisan
bost gizon handi kolpera preso
sartu ginduezan
Baina zergatik izan zan
nahi nuke poliki esan
inozentzian bizi direnak
itzartu daitezan

3. Maiatzeko egun batez
hogeitamar hain suertez
gose greba bat hasi genduan
geure borondatez
Goitik laguntzarik batez
guztia zan geure kaltez
obispo ta apaiz golko-haundiak
lasai bizi beitez

4. Pentsaturiko moduan
Bilboko obispaduan
sotanu baten gela zahartxo bat
atondu genduan
Poliziak inguruan
jarri jakuzan behinguan
gure sabelak etzun goserik
sentitzen orduan

5. Paper bat geunkan egina
laburra baina gordina
bertan azaltzen genduan Euskal
Herriko samina
Zer sermoi ta zer dotrina
bazan zerbaiten premina
barriro ere egingo geunke
kanpoan bagina

6. Hiru egun ta erdira
lotu ta komisarira
ardi gaxoak bezala goaz
geure hiltegira
Jotzen hasiko balira
bizkarrik ez erretira
lehenago ere emondakoak
danak hartu dira

7. Geroztik astebetera
tribunal faltso batera
azaldu ginen gure krimenen
kontu emotera
Mila arrazoi atera
ebezan gure kaltera
karga ederra debalde jaso
genduan kolpera

8. Tribunaleko nausia
trumoi artetik jausia
gizona ala piztia zer zan
dudan gagoz ia
Eztula ta aharrausia
haren zientzi guzia
esku onetan dago mutilak
gure justizia

9. Ezker eta eskubira
ha zan ezpata dirdira
pentsa zeiteken sartu ginela
sugeen habira
Ikaraz nengon begira
bost juezen aurpegira
akerrak ere haien ondoan
pizti finak dira

10. Juizio xelebre hartan
poz bat nuen neure baitan
halako pizti saila debalde
ikustea bertan
Baina gauza baten faltan
geratu nintzen penatan
buztanik zeuken begiratzea
ahaztu egin jatan

11. Aitortu nahi dot hortako
abogaduak hainako
saio bikainik San Pedrok ere
etzula botako
Baina guztia zertako
alferrik hitz baterako
hizketan jardun nahiz zaunka egin
bardin zan harako

12. Espainia haundia ta
librea zelan ez kanta
Gibraltar izan ezean hemen
ez da ezer falta
Askatasunez aparta
handian barriz galanta
honelakoak bat izan behar
besterik ez da-ta

13. Agur eginik Burgosi
nahizta ez asko merezi
bueltan gentozen Kriado jauna
gendula nagusi
Bakoitzak zazpi polizi
heuren pistola ta guzi
bideak libre zitun ihesi
nahi zuenak hasi

14. Heldu ginen Zamorara
ifernu zulo hontara
Jainkorik bada dagon lekutik
gaizala anpara
Urte batzuren bolada
gu hemen izango gara
bien bitarte Euskal Herria
askatzen ez bada

15. Pilatos eta Herodes
izan dira gure juez
Anas ta Kaifas ere oraingoz
kontsola daitekez
Hala ere gure partez
lasai gagoz eta bakez
askatasuna kendu dauskue
baina humorerik ez

16. Horra amaitu baïno lehen
bost gizonok nortzuk ziren
bat da Gabika hurren Kaltzada
Naberan ondoren
Amuriza da laugarren
nor falta ete da hemen
guztion buru Nikola jarri
behar nuen goren*

**NIKOLA TELLERIA hau erdi hilik heldu zen gartzelatik etxera. Sei urte barruan egin ondoren askatasunik ia ezagutu gabe hil zen 59 urtekin.*

**BERTSO BERRIAK**
**HORMA ZAHARREI JARRIAK***




**Bertso hauk eta gartzelari dagozkion guztiak ondo ulertzeko, kontuan eduki orduan oraindik apaizak ginela. Azken aldion preso politikoak badaude ere, zortzi urtetan zehar Zamorako gartzela "gartzela konkordatuzkoa" izan da, hau da, apaizentzat bakarrik eta apaizak aparte edukitzeko egina. Orduko gartzela lagun asko apaizgoa utzirik gaude gaur.*

1. Bertso berri batzuek
behar ditu jarri
entzumenik dutenen
entretenigarri
Katez loturik preso
gaituzte ekarri
kantuz azalduko dut
espetxeko berri
inozentzian inor
ez dadin etorri

2. Espainian behera
han dago Zamora
basamortu hoberik
nonbait izango da
Ez mendi ez itxaso
ez belar ez lora
hementxe bizi behar
hainbeste denbora
hain maite dugun Euskal
Herritik kanpora

3. Etxetzar bat hemen da
itxuraz bikaina
goralduko nukena
gorroto dut baina
Erdia zementu ta
erdia burdina
gizonak piztitzeko
apropos egina
hobe zen ifernura
erori bagina

4. Ilunpe hontan bizi
gara erdi hilak
ondo itxirik daude
ate ta zerrailak
Inguruan polizi
ta goarda zibilak
batzuk pistolak eta
besteak fusilak
galtzeko arriskurik
ez dago mutilak

5. Kanpotik ifernua
dirudin kaiola
barrutik zerri toki
edo zerbait hola
Jaten behintzat lujorik
ez dugu inola
tantaka zurrupatzen
digute odola
oraindik bizi gara
nik ez dakit nola

6. Gartzelan sartu eta
lehenengo kolpian
zer ikusteko nintzen
asko ez nenkian
Zerbait gorderik edo
neukan atxakian
batek eskua sartu
galtzontzilopian
sekula inork ukitu
ez didan tokian

Goizean goiz ohetik
jaiki egunero
ur salda zikin batez
gosaria gero
Eguerdian baba beltz
ta holako jenero
hemengo potajeak
probatu ezkero
bizkarrak gizentzerik
ez dugu espero

Baba beltzak nahasturik
harriz eta harrez
hemen gabiltza hortzak
irentsi beharrez
Sabela putzez bete
besterik ezerez
gainera gerrikorik
ibiltzen utzi ez
galtzei soinean eusten
ez daukagu errez

9. Sabela hutsik eta
loturik mingaina
goitik behera zigorra
txakurrak baigina
Hau da gertatu zaigun
espetxe zikina
oraindikan burutik
sano gaude baina
badira motiboak
zoratzeko haina

10. Nagusi bat daukagu
zirkuan hazita
pizti bildurgarria
aurrez ikusita
Oraindikan hizketan
ez du ikasi-ta
uhuka hasten zaigu
begiak itxita
orangutan garbia
trajea jantzita

11. Lotsagarri da baina
sinestu hau jaunak
ate gabe ditugu
hemengo komunak
Testigu gabe hortan
ohiturik ginanak
agiriz egin behar
ezkutuko lanak
erakutsi ditugu
dokumentu danak

12. Deskoiduz inork ezer
egitera oker
kalabozo batean
sartzen dute laster
Hantxe hainbeste aste
nahizta barruak leher
ez ohe ta ez aulki
ez mahai ta ez ezer
arratoiak hobeto
daude mila bider

13. Nahizta mila gizonek
izan gure kargu
Madrilera jo behar
ezer nahi badugu
Handik berriz ezetza
aurretik dakigu
gorroto gaituzte ta
zertako erregu
holakoxe piztien
eskuan gaude gu

14. Obispoak gurekin
ondo egon nahiez
noizbehin etortzen dira
baina gu joan ez
la nazka gaituzte
hainbeste folklorez
hobe hurren ontzian
astronauten ordez
hilargira botako
balituzte trabes

15. Konkordatu zikin bat
hartuz atxakitzat
militarren eskuan
elizako giltzak
Obispo jaunok horri
eusten gauza handitzat
gaiztoak ez badira
tontoak bai behintzat
edo biak batera
hobeto deritzat

16. Bisita egunak ere
begira zer dian
amakin egin behar
erdara garbian
Gainera burdinazko
bi sare erdian
eta alkahuete bat
albotik goardian
burduntzi bat sartuko
nioke ipurdian

17. Ilunpean dagonak
maite du argia
baita egarri denak
ere ur garbia
Noizbait hautsiko ahal da
gure uztarria
hazia sortzen denez
lurpean jarria
gartzelan erneko da
Euskadi berria

# BERTSO BERRIAGOAK HORMA ZAHARRAGOEI JARRIAK*

1. Otsoak zazpi ume
atsoak hiru haur
preso sartu nautela
lau urte dira gaur
Egunak luze bezain
esperantzak labur
Askatasun Amari
gure partez agur

2. Senarra izorrante
emaztea izor
bizirik ehorzteko
ez zen jaio inor
Hormadi zatar hori
jarri zutenei hor
gorrotoaz besterik
ez diet ezer zor

3. Gure mando gaxoa
eztulka zen ito
gartzelan berdin zaigu
deabru nahiz jainko
Burua hormaren kontra
jaurti eta kito
ea bietatik bat
hausten den betiko

**Bertso hauen doinua "GASOLINA MADARIKATUA" izeneko bertsoena bera da. Badira beste anitz doinu ere neurri honetan.*

4. Sitsak hiru fraideri
zilborra jan zien
aurreko etsipen hitzak
gezur hutsak ziren
Zer horma zer gartzela
ez naiz penaz hilen
gaur maite dut bizitza
sekulako gehien

5. Bi zorrik egin zuten
zerri lapurreta
ez pentsa nagoela
gibelak erreta
Noizbait helduko ahal da
itsasora erreka
gartzela serioan
hartzen dut barreka

6. Ahuntzak bizarrak bere
haitza izerbera
eguna pasatzen dut
berdetik berdera
Nahastu zait euskera
ahaztu erdera
nahaspilduko nuke
Luzifer berbera

7. Oilarra oilo zale
uda eta negu
lau hormei piz juxtuan
egiten diegu
Lumak harrotu eta
arraultzak zimeldu
lasai libre uzteko
moduan gaude gu

8. Trenbide bat egin dut
bere bi errailak
direna gartzelero
jaunen barrabilak
Bertan gora ta behera
tren bat darabilat
dibertsio hoberik
ez dago mutilak

9. Arraultzek brist eta brast
gorringotzen elkar
gurpilak irristaka
trena iraultzear
Madril ere nuela
tortilatu behar
tatarrez itzarri naiz
ohapean zehar

10. Ez dela badelako
mundua komiko
amets hau egi balitz
geundeke polito
Birrintzearren hoien
aleak betiko
neure bat pozik nuke
trenpera jaurtiko

11. Ohean asperturik
komunera alde
gure gau klub bitxia
gainera debalde
Nahizta emakumetan
aukera handi gabe
galtzak kentzeko behintzat
badut libertade

12. Pizontziei banaka
apuntatzen diet
nahizta tentatzen naute
makurtegi biek
Eskolan edukirik
komenentzi hauek
ez nituen pasako
hestualdi haiek

13. Bizitza Jainkoaren
dohain bikain omen
kaka kolore eta
usaina du hemen
Jakintsuak galdezka
gizona zer nor den
komuneko zulotik
ikusten da ondoen

14. Noizbait filosofoei
sinetsi niena
okadaka botatzen
ari zait barrena
Bonbari tiraturik
hau duk gozamena
nola urak daraman
kakatara dena

15. Norinahi diot barre
egingo to zein no
ahotik ezin bada
ipurditik koino
Heltzen bazaizkit zulo
hau ere ixteraino
ez duket barrez erre
mentatzea baino

16. Galtzak jatsi baino ez
altura erdira
horra bi gartzelero
leihotik begira
Baldin mamu berde hoik
gizonak badira
nire atzeak dauka
ispilu dirdira

17. Nola biak baitira
marikoi famatu
neuk seinalatzen diet
nora begiratu
Hau izorrategia
dutena montatu
atzetik eman eta
gainera kobratu

18. Galtzak ditut burdina
sarean eskegi
barreak urtzen dizkit
sudur eta begi
Desbarrabilmendu hau
ez al da gehiegi
gau on marikoi jaunak
osasuntsu segi

19. Leiho zulotik galdez
nago bi izarri
ea nagoen uste
bezain barregarri
Bihotza dadukanak
triste edo larri
eman mun buztanpean
aker zaharrari

## ZAMORAKO SUGINTZA




• *Doinu hau neuk eginda da*

1. Ke azpitik su gainetik
gar artetik ihesi
uhuka sei ehizi
hauts eta putz ahal zen dena
erre eta erauzi
Ai gartzela Zamorako
nola geratu haiz hi
eskerrak sei apaizi
ez zaik ezer sano utzi
egik sutan garraisi

2. Sei tximistek ifernutik
bueltan eztanda hemen
aitaren semearen
gartzela hankaz goratzeko
aski zen ordu laurden
Lotegia gar eta ke
eliza ere ondoren
barka Jauna zer hoben
nekez dugu berriz gaurko
San Juan surik eginen

3. Mahai ate komun leiho
hausten ezin kontsola
hura kristal uhola
telebista patioan
tripak zerizkiola
Gotzain eta Aita Saindu
gutaz gaur arte nola
bost zareten axola
horra zuek barru erre
beharreko kaiola

4. Estadua izorrante
Eliza ere halaber
etzan ziren eta zer
konkordatu deitzen zaion
munstro-kume bat ager
Horren mende behar al guk
nahiz axola bi biper
nahiz ukatu ehun bider
noizbait behar zuen gure
pazientziak leher

5. Errukarri barregarri
hago gartzela zahar
gantzak airean zehar
garai zuan kraska hendin
henzan osorik su har
Laster haute hi jasoko
guk preso segi behar
baina gogoan ezar
badugula hi berriro
hausteko haina indar

6. Gaiztoenak badira ere
zer egin sei ehizik
zuloan gorde baizik
gainera eror badakie
harmada oso bat kasik
Falta zena haustera ote
zetozkigun gu pozik
baina han ez zen deusik
apurtzeko zegoenik
geure bizkarrak ezik

7. Buru zela zuzendari
jauna edo jaunskila
hura pizti koadrila
ke artetik putz eta eztul
esku haina makila
Gu orduko denok mantso
horman eguzki bila
izarrak ere mila
gure lanak hor daude eta
orain zernahi dadila

8. Nola larru dena dudan
ez zela egon uste nik
uste zen egurterik
kalabozoetan gaude
ahoa hortzez beterik
Pentsatzea ere hona
gizona botatzerik
ez argi ez airerik
azkonarrak egiten dik
non nahi zulo hoberik

9. Sei oin luze zabal zortzi
gora bi beso jaso
komuntzar bat beti so
hauts hits hotz huts kirats gauantz
baina isi ta iso
Bost lagunak ere hor nonbait
okerrago akaso
nola haiz gorputz gaiso
gure arima beletzarrak
darama basoz baso

10. Hemen nago hemen gaude
orain bigarren guda
gose greba heldu da
ez dugu ezer jan edango
horma hauetaz barrura
Lor nahiz eror irten arte
edo kanposaindura
han ez zaigu ardura
lur nahiz zeru nahiz ifernu
ala harren kontura

11. Bat bi hiru lau zer duk hau
bost hemen sei azkonar
lurrean etzan behar
isi sabel zazpi zortzi—
egik alferrik negar
Bederatzi hotzez dardar
bihar mutilak hamar
zer diok hik komuntzar
gaur hamaika hamabi duk
hik hamairu izen txar

12. Txar den on dén bai den ez den
zer duk ez duk hamairu
deabrua aingeru
goizaldean horra deika
hiru berdezko miru
Egia den baietz omen
agur Zamora mairu
izotza urtzen ari du
gose hotzen pozen ura
sudurretik darigu

13. Artzak bartzen galtzak sartzen
hemen gaude Madrilen
ez gara hil ez hilen
oinak kili soinak kolo
baina buruak gailen
Jan mutilak jo matrailak
ez kezkarik makilen
laster jakinen Gilen
jaun akerren buztanpean
zer sar irten dabilen

14. Jakin dugu nahiz ez dena
baina zati bat behintzat
zer hautsak eta brintzak
jaso dituen kanpoan
Zamorako sugintzak
Nork ordea pentsa dantzan
jartzea gure ekintzak
ahuntzak bezala haitzak
ministroak hoska eta
dioska diabiltzak

15. Aspaldi zen haien esku
gure eskeen karta
beti denbora falta
segur omen geunden hemen
giltzak ondo botata
Horra orain onez inoiz
ezin zutenek trata
kea ikustean salta
sua jaunak piztientzat
etsai okerra baita

16. Hamaseira heldu gara
beste lau eta hogei
bost laino beltzek hodei
bide erdina dagokie
harrei eta gizonei
Gorbeako landan bazka
basa zezen eta behi
han mila gu hemen sei
inon sugin nahiz hautsginik
behar bada egin dei

## BERRIRO ERE ZULOAN




*Doinu hau neuk eginda da*

1. Zuhaitzak inoiz harkaitzak beti
bortxaz bihurtzen haizkora
hora berriro ustez betiko
utzi genuen Zamora
Ezin sinetsiz begira nago
gora behera albora
nongo indar gaiztok gakartza berriz
lehengo azkonar zulora
ez dakit Jainko sorgin deabru
ala zein aker adora

2. Hara ostadarrak zazpi kolore
hona hemen sei aztore
Akelarretik dei hartu dugu
ez emateko amore
Hurkamendian inarra more
gose-mortuan birlore
badugu beste baraute luze
bat hasteko haina adore
basurde ama eskaini zaigu
gure arimen jagole

3. Bat lau hamalau egun eta gau
bost hamar bi astebetez
mamiak ihes hezurrak non ez
tente gaude ia nekez
Hatza hor gorputz hago hor lasai
hormak ere hor konpon bitez
aterako haiz aterako haute
oinez edo katabutez
beste munduan hiretzat lain lur
badukek harren suertez

4. Barrua marro larrua harro
hesteak irenska elkar
jango genuke akertzar bana
buztan buru eta adar
Arratoi pila bat eztarrian
gora irrintzi eta negar
matrailak ere hortz eta guzti
tiraka eraman behar
zer ote dira gose herriak
bizitza osoan zehar

5. Bele atsoak sei arimakin
egin omen du lixiba
hura haiekin harria jotzen
albotik barrez aingira
Eliza sutan kanpaiak dindan
mirua goitik begira
saguzahar aldra ketatik salba
ezinik ero ari da
jango nituzke saindu guztiak
haragizkoak balira

6. Filosofoek teologoek
zer hitz zer ipuin jario
jakintsu ustez denen artean
putz bat ez dute balio
Zer erlijio zer misterio
zer eliza eta arraio
seitatik bosti bere izerdi
gehiena kentzen bazaio
noiz arte engainuz jantzirik hilko
biluzik zirenak jaio

7. Medikutxo bat hor ari zaigu
zirri hemen zimiko han
ez dakit norantz duen itzala
galdu ez badu kanpoan
Ziztrineria anbulante hau
bildur naiz bide zokoan
gurdiren batek harrapa dezan
untxiren bat delakoan
zientzia ez da beltzez jantziko
hori gertatutakoan

8. Haizeak zorrotz jotzen leihoska
txakurrek urrundik zaunka
ileak erle errotak ehunka
belarrietan furrunka
Herensugea leize ahoan
sei lehoirekin burruka
ez bada denak buru bat behintzat
mozterik ai bageneuka
zer zaigu axola lurpe arbola
ehortz gaitzaten nahiz hurka

9. Ur gabeziak udan lehorte
izotz luzeak negute
hala aurreak nola atzeak
lana eskatzen digute
Uzkiolako maizterrek lurra
aspaldi geldi baitute
kilkirari eman diogu errentan
kanta kilikorren truke
ertzak apur bat apainduz berak
zuloa eginik luke

10. Gaztain oskol bat lau adar irten
eta ibiltzen hasi zen
gizon tentelak ikusi eta
kirikino jarri zen
Hori hala den alderantziz den
tximino buztana naizen
hara amarauna eltxoz iruna
armiarma jauna gizen
jango nituzke mila barrabil
Madrilen eta Parisen

11. Aizak ispilu esak egia
gure irudi al haiz hi
geriza horri al deritzate
izadiko jaun nagusi
Gizonak ala mamu hondarrak
zer garen ezin berezi
sabela ari ez balitzaigu
orroa eta garraisi
dudan geundeke gure galtzetan
ba ote den inor bizi

12. Aitak bizarra amak bularra
umea bien haragi
milaka jende eta abere
da lur iraulketan ari
Pozik geundeke gure ekintzak
dela urri nahiz ugari
zotz baten garrik badio ezarri
burruka osoko suari
nahiz bi metroko zulo bat gero
izan gure azken sari

13. Pentsa ez pentsa garaunak dantza
hortzak hortzari darauntsa
badugu gose haina humore
betetzeko sabel hutsa
Uhinak hegan izarrek edan
bizirik goaz goruntza
hilargia eror baleak irents
gorpu da gure gorputza
hala ez bada Jaun Luziferren
alaben altzoan gautza

14. Hamasei egun hamalau bertso
hamaika goseri eutsi
erdi hil-bizi labeak utzi
bi hankadun sei burduntzi
Oraingoz jaunak hau bukatu da
luze nahiz labur eritzi
geratu zaigun biziaz agur
maite gaituen anitzi
hilik ikusi nahi gintuztenei
barka eta mila goraintzi

## DESKALABRUA




**Doinu hau neuk eginda da*

1. Deskalabru bat deskalabru bi
deskalabruen segida
zenbat deskalabru dira
gure etxean bart gertatua
deskalabru ta erdi da
Mahai eta ate saltatu dute
teilatutik hilargira
ni ohapetik begira
jango nituen izar guztiak
sorgin hutsak ez balira

2. Erloju zaharrak hormatik jo du
zentzuaren akabera
buztan galduen karrera
arima hilen itzal biziak
biluzik zaizkit atera
Aker gorriak ugazabaren
izpiritua berbera
eraman du hurkabera
arrano beltzak haren bihotza
bota du haitzetan behera

3. Sei musker eta zazpi tximista
ditut ohean ediren
maitaketan ari ziren
eta andreak ene andreak
ditia ematen zien
Ugazabaren gibel ustela
biztu omen da Madrilen
ez al du harriak hilen
ez dakit batzuk nork ekarrita
mundura jaiotzen diren

4. Zazpi saguzahar erraldoik ene
gelan hegan dihardute
burugain eta burupe
sasirik baso Akelarrera
sekuestratu nahi naute
Ugazabaren andre gordina
lukainkatu omen dute
koartilu ta erdiren truke
egia balitz deskalabru hau
errentan hartuko nuke

5. Tximini puntan ari da dantzan
zerri belarri gorria
sei arroako zorria
mando nabarrak soinua jotzen
oilar gainean jarria
Animalien eromenean
askatu da aberria
libre da Euskal Herria
etxea hautsi didate baina
egiten dago berria

6. Lurpeko haize guztiek gure
ganbaran jo dute elkar
zurek karrask hormek negar
Newtonen lege denak galdurik
nabil ohapean zehar
Maitasunaren kodigu zaharra
erreko dutela bihar
idi zuriak diragar
atsoak umegintzan hastea
besterik ez dugu behar

7. Haizerik leize natorkizue
deskalabrutik ihesi
nahi nuke hil arte bizi
gure etxea urak darama
ez al duzue ikusi
Bart ugazaba andre ta guzi
galdaran dute egosi
egik zerura garrasi
gaur behintzat hemen geu gara jaunak
Euskal Herriko nagusi

# LAPURRETA NAGUSIA

Egun da Santi Mamina
benetan egun samina
goiko zeruan gorde dezala
luzaro bere arima

1. Katean txakur humila
atean utzirik hila
bart goizaldean etxera sartu
zaigu Kriston lapur pila

2. Sartu ziren sartu eta
hura ez zen berriketa
aitari sustoz eskuan bertan
urtu zaio eskupeta

3. Ama negarrez ganbaran
haurrak ikaraz dardaran
lau hormak eta haizea ez beste
guztia dute eraman

4. Trajedun zaldun bapoak
gerripetik gorakoak
karreradunak ziren guztiak
ministro ta holakoak

5. Bota nuen garraisia
non zegoen justizia
nora jo baina beren artean
baitzen juez nagusia

6. Egon nintzaien begira
sabelpetik aurpegira
haien ondoan beste lapurrak
aingerukumeak dira

7. Zerura egin nuen dei
ez zuen inork entzun nahi
Batikanoko firma zekarten
indulgentziak ere bai

8. Ifernuko deabruen
laguntza eske jo nuen
jo nuen baina suak itzali
arte greban omen zeuden

9. Banku dira lapur miru
bat eman ta kendu hiru
barbaro jaunen inbasioak
etxea irentsi digu

10. Gure etxea Euskadi
muga bat eta puska bi
ez naiz isilik egongo nahizta
hurkamendian eskegi

11. Egun da Santi Mamina
ez litzake hain samina
beheko ifernuan gordeko balitz
lapur jaun hoien arima

## AMNISTIA GEZURTIA




*Bertso hauk lehenengo amnistia ezerez hura eman zutenean eginik daude. Doinua neuk egina da.*

1. Semaforoak gorri ta berde
berde gorri eta zuri
oihuka doan jendetza horrek
trumoi uhola dirudi
Suak ireki arte gartzelak
ez inor kaletik mugi
fabrikak urtzen badaude ere
zer axola zaigu guri
ez dugu alferrik lehen ere hainbeste
odol izerdi isuri

2. Bart gauerdian sasirik baso
joan nintzen Akelarrera
Euskal Herriko notiziekin
Aker Jaunaren aurrera
Amnisti horren berri entzunda
jango zuen Hitler bera
bera joango omen da hurrengo
ministroen batzarrera
jende horrekin hitz egitera
akerretik akerrera

3. Berrogei urte harri egurte
elur eta beldur negu
amnisti horrek hezurra eman
eta mamia gorde du
Zer jende diren badakigu ta
zertako egin erregu
hoiek ez dute ezer emango
geuk kentzen ez badiegu
emango dute kenduko zaie
bestela zertan gaude gu

4. Eskatzen zuten egunsentiko
oilar zuri ta gorriak
kanposainduko harriak eta
hurkamendiko horriak
Eskatzen zuten zeru ta lurrek
eskatzen zuen herriak
eska eta eska segiko dugu
hautsi arte eztarriak
eska eta hoska apurtu arte
kate zahar eta berriak

5. Bota dituzte sekula preso
egon behar ez zutenak
bota dituzte hainbeste urte
luze eginda gehienak
Terroristatzat jo eta bertan
geratu behar onenak
ez da bakerik ez arraiorik
askatu arte den denak
edo barrura eraman arte
kanpoan libre gaudenak

6. Tigre emea bere umeekin
lotan ere beti ernai
defentsarako noiz nahi prest eta
noiz nahi atakatzeko zai
Hau da oihua lanean eta
kalean aste eta jai
kanpora denak behera burdinak
desterru mugak ere bai
justizia da behar duguna
limosmarik ez dugu nahi

7. Keak itorik hiltzen zuloan
ezkutatzen den piztia
irten etxetik eta atakez
lortuko da amnistia
Ez baita jaunak hori bakarrik
eskatzen dugun guztia
diktaduraren azkena baizik
odol izerdiz bustia
diktaduraren hauspena eta
askatasun eguzkia

## BARRUAREN BARRUTIK




* *Doinu hau neuk eginda da*

1. Trumoia ortzi beltzean hoska
bertzean zortzi arbi egoska
gauaren barren bi erbi erren
lauaren hurrengo bosta
Denok berdinak garela zuhaitz
beretik omen gatoz-ta
bihotzak ezetz diosta
nik ez nitzake jende hoik maite
nahizta ifernua kosta

2. Washingtonetik Pariseraino
Madrilen harri Erroman laino
jaun eguzkiak izotz guztiak
ez ditu urtu oraino
Suge-andrea lehenago dut
gauero hartuko maiteño
bihotz apurrik dudaino
nik dakizkidan higuin-kume hoik
maiteko ditudan baino

3. Haizea kexu usoak izu
sudur zulotik sua darizu
giza basaki basa gizaki
gizonen jaun eta maisu
Hanka bikoitzak buztan gabeak
nola garen ni eta zu
tximinoen lehengusu
hoien arraza fitsik baneza
listatik borra nazazu

4. Ez zen haizerik ez ehizirik
basoak mortu urak isilik
gizatzar batek gizona jaten
basurdeak ikusi dik
Nik ez ditut hoik maiteko nahizta
bihotza zula ehun zirik
akaso hilik ez bizirik
maitatzekotan badut nor maite
harrietatik hasirik

5. Aralar zabal zorrotz Anboto
hartzak haitzean egin oztopo
leize bat dago han beherago

dena ustel dena koko
Nire golkoak ez du hoientzat
librerik zoko ez soto
zertako ere gorroto
nahiago nuke hoiekin baino
tximistakin egin topo

6. Urez lehorrez lau hegabera
hiru goserik bat egarbera
leizera jaurti zuten gizona
saitzarrek deman atera
Ez pentsa bihotz hoik maitatzerik
ez apurrik ez sobera
nahi ez badun bat batera
zatika oka hazadan bota
txakurrari mahaipera

7. Maite dut sua maite izotza
iparra eta hostoen hotsa
dena dut maite zer ez dut maite
baita sugearen hortza
Baina ai gizon gizatzar gizen
pozoina duk hitaz lotsa
altzak altzari diotsa
nola maitatu hura maitatuz
duena usteltzen bihotza

8. Hontza zamaltzain ahuntza zamari
aker aitona putzari adi
kukuak soinu muskerrak dantza
ni haritz puntan kantari
Hoik nortzu diren non bizi diren
hain daude hur hain ugari
nola zara galdez ari
aitor maitatzen ez dakizula
goraintziak oilarrari

**NESKAZAHARRAK ETA APAIZAK***




**Gartzelara sartzea lortzen zuten berri ondo zentsuratuen artean hauxe heldu zen behin, alegia, bi apaiz gazte bi neskazaharrekin joan zirela ez dakit nora bi egun pasatzera (beraz gauren bat ere pasa beharko) eta eskutizgileak eransten zuen: ''Bertsolariak zereginik ez badu, hor dauka gaia''. Doinua neuk egina da.*

1 Neska zaharrak eta apaizak
hartuko ditudan haintzat
eskatu didate gaitzat
ai ama nola josi elkarri
banaka dituzten gaitzak
Altzak bihotzik ez badu ere
eduki lezake haitzak
biguntzen badu ekaitzak
tximista baten bildurrik ez du
maitasunaren zuhaitzak

2. Zaldia triste behorra mizke
hegoa iparrak aske
neska zahar apaiz gazte
larrerik larre gartsuki omen
dabiltza elkarren eske
Hauei urriki diet bihotzez
ez ordea haiei beste
nigatik konpon zaitezte
zoriona eta aker gorria
noizbait nonbait balitezke

3. Edadeak du larrua izurtzen
zenbat urte ditun aurten
baina ez gogoa joaten
tenta ditzagun apaiz gazteok
ea norantz jotzen duten
Jauna zuekin hi neronekin
ez suari txingarrik ken
nora nahi dun bihar irten
lau uso nabar hara biontzat
habia urdin bat egiten

4. Neska zaharrak eta apaizak
uhuka meza ondoren
Akelarren batzen omen
han ez baitute konturik hartzen
ez urteen ez botoen
Aita Saindua oherik leiho
dabil inoizko eroen
deabrua non Kristo den
aurkituko ahal du Euskal Herriak
fedea galdu baino lehen

5. Ba omen dira neska zaharrak
gazte dutenak bihotza
gainekoa ere ez hotza
nahizta eduki jaiotza baino
hurbilago heriotza
Non ote zen bart gure apaiza
santuzain utzirik hontza
gizona beti gizontxa
hoik libre eta prest dauden arte
tximinoentzat ezkontza

6. Ez nago alde ez nago kontra
entzuna kontatzen baizik
ez omen baitago kasik
neskazaharren bat gorroto edo
maite ez duen apaizik
Egia dela gezurra dela
oilarrak goizean goizik
hatzeman gaitu biluzik
ez dinat ezer jantziko maite
eranzteko izan ezik

7. Muskerrak duen libertadea
hormaz horma harriz harri
gizonei ukatzen sarri
nigatik argi berdea zenbait
apaiz eta neskazaharri
Libertadea bada gauza bat
hain handi hain hordigarri
hain bagara horren egarri
eduki ahal dugun apurrik
ez kendu behintzat elkarri

## ANBOTOREKIN TRUKEAN




**Doinu hau neuk egina da*

1. Tximistak flist flast goiz eta arrats
haizea norantz lainoak harantz
mila min ditut milana bider
laurehun gozo seirehun garratz
Hi Anboto bizkar zorrotz
erraldoi mendetsu hilotz
ibarretik dagiat hots
arren emaidak heure zati bat
nik hiri bihotz eta hats
sentimendua zer den dezagun
hik ikas eta nik ahantz

2. Landan saltari hogei zezensko
odolez bero haragiz fresko
bihar doazke larrutegira
haiekin gizon fin asko
Makila edo gartzela
morrontza isila bestela
badakit hortxe daudela
baina ni lasai ez min ez pena
bihotza baitut haitzezko
gehienaz honi goroldio erdi
hilak bakarrik datxezko

3. Barrea azal nekea zakon
noiz zara hilko aitona senton
lehen jaunentzat laster harrentzat
jan ez bazaitzate berton
Zure ilobaz bete da
hiria alderik aldera
goldetik datoz labera
baina niri zer idi nahiz aker
triste bazaude hor konpon
zure minentzat ere haitzen bat
geratuko da Anboton

4. Larruz jantzirik ez beste deusik
ninduen amak sortu biluzik
biluzik ama zure larrua
ere galdua dut kasik
Zastatu naute noiz-nonnahi
pozoina sartu ere bai
baina niri zer ni lasai
haitza golkoan ninteke joan
hurkabera ere pozik
ez baitakit nik sentitzen minik
bihotzetik pasa ezik

5. Gutti nenkien sentimenduen
kargak hainbeste zaurimen duen
eskerrak noizbait Anbotorekin
trukea egin bainuen
Nola gizatzar hoik maite
higuineztatzen bainaute
ni bezala bazaudete
proba haitz batek golkoan zenbat
mesede egingo dautzuen
penarik eza zorion bada
ni nauzue doatsuen

6. Bi haur jostari neska mutiko
bat zutik eta bat kokoriko
Perutxok piz-piz Maritxok zotz biz
errekatxoa polito
Baina ni ezin makurtu
ez ditut ere agurtu
zer piztia naiz bihurtu

hau izugarri non duk sentimen
bortitz hura haurrekiko
hik haitz traidore salba beharrik
min eta guzti nauk ito

7. Anbotoko Atso Mari Urrika
libre badaukan suzko karrika
bihur bihotza eta nik haitza
botako dinat harrika
Nor maite deino bederen
penak utzi baino lehen
maitatzea dut maiteen
gizona gizon zerria gizen
ahuntzak haitzik haitz korrika
lurrik lur noa maitasun bila
Anbotoren gain jarrita

8. Bihotz zaurikor sarritan mehar
nola ibili haiz Anboton zehar
hirekin ezin nindunan bizi
hi gabe berriz hil behar
Penak eta zorigaitzak
ezkutuan gorde hitzak
kolpa nahi baduk saihetsak
baina begioi begi ahul hauei
ez otoi eragin negar
nik maite dudan inork ez dezan
hire minetan parte har

# EZ NAUN MAINONTZI*

1. Ez naun mainontzi ez gaztanbera
jaio nindunan buruz aurrera
zer pena dudan jakin nahi badun
hator nirekin haizpera
Ez ditun grina sorginak
ez ditun ez maiteminak
hoik mintzat ere ez dizkinat
baina hitza hain hutsa izanik
nola eman aditzera
zer diren penak jotzen dutenak
arnasaren funtsa bera

2. Tximista batek jo nindinan behin
suge zitalak maiz zistatu nin
zezenak adar otsoak hagin
apoa dena dun higuin
Negarrez maite al hintzen
hoiek ez ninate mintzen
baizik saminak arintzen
gizatzarra dun bihotza ehotzen
eta diona ematen min
hirindu ahala malkoz orhatuz
taupaka hor segitzen din

*Bertso hauen doinua "ANBOTOREKIN TRUKEAN" izeneko bertsoena bera da.*

3. Kaleak bete zango mugikor
dozenan zazpi ostiko doilor
bistaz antzeko baitira usnaz
igarri behar nor den nor
Larrua dinate fina
barrua zornez egina
zornetik erne arima
ez eska nadin etzan hirekin
izuak ez nazan agor
hire sabelak hoielako bat
pentsatuz lezakela sor

4. Bata legegin bia banka-jaun
mundua erdibana dezagun
hoien andreen maitasuna dun
nola golko bete ziraun
Gizona gizonen mailu
beste zer jorik ez bailu
hori bai dela mingailu
ikusten ez den zernahi sinesten
fedea errazena dun
egun eta gau dakusadan hau
ezin sinetsiz hilko naun

5. Kalerik kale anitz haur talde
hiria janzten alderik alde
ez dinat uste mundua hainbeste
maiteko nuken hoik gabe
Hain xarmagarri ttikitan
baina sarri ene baitan
zer ikara sortzen zaitan
biharko giza-jaleak azal
guri hoietan baitaude
ez otoi gaurko munstro hoik atzo
haurrak ziren niri galde

6. Hodeiek ihes tantaiak dardar
trumoiak goitik jo din deihadar
multzoka gautzan hiritzar honek
noiznahi dezakela su har
Biolentziaren mende
lur abere eta jende
menderik mende bagaude
hortako utzi al genizkinan
zuhaitz buztan eta abar
ez egin negar errekak bihar
ur haina odol badakar

7. Hala piztien nola gizonen
gorputz-arimek bost zentzu omen
bat falta dun hor aurrena bera
deitzen zaiona nazkamen
Ikusiz batera oka
eginik hesteak bota
bagenitza hoien kontra
ez lituzken ez hain lasai beren
larrutzarretan egonen
nigatik bertan leher bitez denak
errementatu ondoren

8. Garia ehotzen duen errotak
berdin arantze minezko otak
zer erru dinat haitzak behera
zauritzen banau korrontak
Sentimendua dudaino
indartsuago ni baino
hala behar hiltzeraino
berriro egin nazan amari
ezin eskatu zionat
txarrago luken sortu banindu
zerri hoietariko bat

9. Haizkora sartzen zaion haritzak
kolpeko ezpal bat galtzen din behintzat
hala nire hitzak mihi zati bat
zarrasten zidan bakoitzak
Harri arrain nahiz abere
maite dinat alafede
heriotza bera ere
baina gizona deritzan hori
jo behar etsai nausitzat
horrek ez bahau mintzen esaidan
zeintzu diren beste gaitzak

10. Azaldu natzain barrenez barren
gorde esanok golkoan arren
hara eguzkiak goizero zenbat
adore berri dakarren
Dela odol nahiz izerdi
munduak badin alderdi
ederrik bederen erdi
milaka aldiz ninduken berriz
jaio ta hilko pozarren
hi bezalako hainbestetarik
bakar bat maitatzearren

## GASOLINA MADARIKATUA



1. Akerraren adarrak
izarretan gora
gasolinak igon du
nik ez dakit nora
Berriro ez badator
lau hankako moda
kotxea bizkarrean
hartu beharko da

2. Lau gurpil polit ditu
gure berebilak
laurak ibiltariak
eta biribilak
Horik martxan ipini
nahi bada mutilak
hestutu behar hortzak
edo barrabilak

3. Txakurra mikelete
agoazil katua
zein deabruk darabil
munduko tratua
Arimak behar omen
ur bedeinkatua
kotxeak gasolina
madarikatua

4. Nork lezan Washingtonen
ifernua ireki
itzalirik balego
dolarrez izeki
Petrolio putzuei
su eman hobeki
arabeen odola
dela ez baneki

5. Gure anai arabeen
odol beltz likina
munduko zerri jaunen
salda atsegina
Gasolina genuke
itotzeko dina
lapur haundi batzuren
morroi ez bagina

6. Hezurne Gezurregi
gezur hezur truke
urri dagola zerri
jaunek dioskute
Gasolinatzat ura
asmatu balute
kunetan egarriz hil
beharko genuke

7. Gasolina dionak
beste zernahi dio
zerbait jan edan behar
zer erremedio
Inflazio puta bat
delako medio
lanak denari eutsi
behar omen dio

8. Laster komun paperik
ere erosi ezin
pentsa beharko nola
bakar lanak egin
Atzea hamar hatzekin
hatzak mihiarekin
garbizalerik bada
badu zeri ekin

9. Gasolina da odol
beltz iragazia
larruari darion
izerdi gazia
Langileen adarrak
jo dú garrasia
errekak ere sutan
omen doaz ia

10. Mundua da laino bat
lanetik irtena
lanezko laino landa
lainozko lan trena
Lanetik bizi gara
lana dugu dena
gehienok norberea
ez guttik bestena

11. Gizonari buzoa
mandoari txalma
gure lanik erdia
haizeak darama
Orroaka ari da
trumoiaren ama
gizonen mandazainok
ditzagun desarma

12. Bizi nahi ez badugu
hil arte gatibu
aprobak egitea
behintzat merezi du
Langileoi gerria
mehatuko zaigu
baina berei arnasa
itoko diegu

13. Gu kapaz ez bagara
umontziko haurrek
jaio-greba hasteko
jo du Akelarrek
Berdin diote Euskal
Herriko oilarrek
barka haurdunok baina
merezi din horrek

14. Hamairu birao berri
azkena hamalau
gasolinak hartuta
suak eraman nau
Langileon burrukak
indartsu badirau
laster bukatuko duk
esplotazio hau

**HEGOATIK IPARRERA**



1. Hegoatik Iparrera
haizearen gudari
hegan nator eta badut
zer kantatu ugari
Bihotzaren barreneko
sentimenduz naiz ari
arnas pixkat eman nahirik
gure Herri zaharrari

2. Euskaldunak hiru gauza
maite zitun aintzina
osasuna ardo zaharra
etxean andre fina
Ez zekien zer den gaurko
libre bizi ezina
hobe denok orain bostehun
urte jaio bagina

3. Nik bi gauza maite ditut
eta ez dakit zein aurren
bat da neure bizia eta
Euskal Herria hurren
Bizi bakar hauxe ere
eman leike pozarren
preso dugun herri zahar hau
libre ikustearren

4. Zozo beltza kantuz dabil
egunsenti gorrian
ez baitaki zer gertatzen
zaigun Euskal Herrian
Guk ere alai joko dugu
haritz baten gerrian
gaur neguan dugun Herri
honen udaberrian

5. Txoritxoen destinoak
jartzen nau atsekabez
kantaririk politenek
kaiola dute babes
Euskaldunok libre bizi
nahi dugu txoriak lez
kantatzea maite dugu
baina kaiolarik ez

# BERTSOLARI BERRI BAT*

1. Bertsolari berri bat
sortu da Goiz-Argin
''Dakiana'' dio ta
nor den ezin jakin
Dakiena da nonbait
euskara nahiz latin
badu gatz haina pozoin
hitz haina hortz-hagin
sugea basurdeaz
enamora dadin

2. Imanol Ondarruko
harturik blankotzat
galdu gordean datoz
bala burumotzak
Entzun hutsez norbera
irensten du lotsak
hitz hauk normal diktat
dituen bihotzak
galdurik du pultsua
jo du heriotzak

**1977-ko Otsailak 5-eko GOIZ-ARGIn, 327 garren zenbakian bertso batzu agertu ziren ''DAKIANA'' izenordez firmaturik. Nire erantzuneko aipamenez gainera, honelako esanak agertzen ziren bertso haietan: ''Errespeto ta lotsa sustraitikan hausi''; ''Erein duzun haziak iruntsiko zaitu''; ''Danak nastu dituna lotsarik ez du-ta''; ''Komunista zikin''; ''Buztartuta erriko buruariñekin''; ''Bi ostiko emanda oinpean zapaldu''; ''gaizkille hau lertzeko'' eta abar. Doinua ''BERTSO BERRIAK HORMA ZAHARREI JARRIAK'' izenekoena bera. Badira beste doinu batzu ere neurri honetan.*

3. Nolako aita dugu
"Dakiana" dela
bertsoak bidaltzeko
haur bortak bezela
Lotsagarri izaki
hain fardel ergela
ala esango al dut
argi erregela
izengabeak aita
gabeak direla

4. Hitz hauei zentzu osoz
hartzekotan kargu
berriz buztan harora
itzuli gara gu
Bertsolariz gainera
dirudi letradu
ahoa bezalako
ipurdia badu
sudurrak kantzelatu
beharra daukagu

5. Tximua zenbat eta
arbolan gorago
uzkia bistarago
nahi baino gehiago
Bertso hauk erortzean
oihana akabo
sakristia kiratsik
ere franko dago
habituren bat ez da
urruti izango

6. Hala arrantzaleen
nola langileen
grebak zirkuak diren
antza dago hemen
Imanol berriz denen
domadore omen
jaitea komeni
zaigu hil baino lehen
Ondarrun horrenbeste
tonto noiz jaio den

7. Baserritarrak ere
haugatik adio
errotak behintzat ez du
askorik balio
"Berriztar errotari"
burla gisa dio
gure Pello Errotak
entzuten badio
bertso hauk egitea
damutuko zaio

8. Marx ere aipatzen du
ez dakit zertako
akaso bizi dela
uste duelako
Alderdi Jeltzailea
ez dago txit bapo
kuku hau behar badu
propagandarako
isilduko ahal zaigu
santa sekulako

9. Dena delako horrek
egin du azaina
nor den ez dio baina
hartzen dut usaina
Goiz-Argi itzaltzeko
bonberu bikaina
nahiago luke balitz
ezin alajaina
Imanol "zoroaren"
eztul erdi haina

10. Hik Imanol ez eman
lo galdurik horri
ez hadi kanibalen
sarera etorri
Ez haut defendatuko
aski haiz herori
hi ez haiz horren "txerren"
ez "katamotz gorri"
heure etsaiek ere
bazekitek hori

11. Ni ere ez naiz ari
oso gizalegez
motiboak baitaude
jartzeko aldrebes
Zoazte Ondarrura
Imanolen galdez
gero Goiz-Argi hori
irakur mesedez
orduan esan zuzen
nagoen ala ez

12. Hamabigarrenean
dezadan akaba
berak ere dozenan
luma baitu laga
Maisu berri bat heldu
zaigu eskolara
bertsoak nola egin
istilua bada
nola ez egin behintzat
enteratu gara

## XALBADOR


Be - gi - ak her - tsiz ar - na - sa i - ren - tsiz hortz ar - te -
an he - ri - o - tza sen - ti - me - na - ren mai - la - rik
mai - la hon - do - ra - tu dut bi - ho - tza ba - dut zo - ko bat pul - tsu ga -
be - a o - do - la - ren min - tzo hu - tsa han da - go zu - tik lo - re ho -
ri - tan tris - tu - ra - ren e - rei - no - tza han e - hor - tzi - rik zauz
- kat Xal - ba - dor han da - tza zu - re a - bo - tsa

1. Begiak hertsiz arnasa irentsiz
hortz artean heriotza
sentimenaren mailarik maila
hondoratu dut bihotza
Badut zoko bat pultsu gabea
odolaren mintzo hutsa
han dago zutik lore horitan
tristuraren ereinotza
han ehortzirik zauzkat Xalbador
han datza zure abotsa

2. Ene golkoan dudan zokoa
hasperenez estalirik
zu zautzana eta ni ere sarri
etzaten naizena hilik
Barren hartatik mintzo natzaizu
gau ihintza bezain isilik
ni ere hilotz natza zurekin
edo zu zaude bizirik
zure begia ikusten baitut
izar batetik zintzilik

3. Zu hilez gero zu galduz gero
hau zait Xalbador saminen
nola hain maite zintudalarik
jakin gabe joan zinen
Baina berbiztu bazintez ere
eta bidean ediren
odolak diost ez nizukela
aitormendu hau eginen
maitasun handi gehienak bertan
hiltzeko jaio baitziren

4. Nahizta bizitzan hitz asko egin
gabeak ginen elkarri
aski zait zure behada hura
zure barne ezaugarri
Zuk ere baldin Xalbador jakin
nahi bazenu nire berri
ez dadukazu zertan galdezka
berriz mundura etorri
galdegiozu lurrak irentsi
dizun itzal triste horri

5. Zure behada ostarkuzkoa
hain tristea betidanik
nondik zetorren eta zergatik
ez da jakingo jadanik
Nahizta agian zerbait horretaz
banukeen zer esanik
nola zuk inoiz adierazi
gabeen berri eman nik
hilen hezurrei emango diet
zure ondoan etzanik

6. Gau isileko bakarmortuan
Hilargizko maindirea
itzal galdu bat aurkitu nuen
izar hilen ahaidea
Xalbadorrena zela esan zidan
bazuen zure airea
soinean hartu eta mugarantz
jaraitu nuen bidea
geroztik itzal bi daramatzat
zurea eta nirea

7. Zure abotsa oihan barneko
lur eta sustraiz egina
gogarazten dit haritz orpoan
ehortzi nuen arima
Hego iparrek menderik mende
bilduriko giza mina
zure mintzoak kantatu digu
odolean irakina
ilunabarrak gorde dezala
zure oroimen samina

8. Beste munduko sinesmen finez
hots egin zenigun sarri
aitortzen dizut hori ez dela
niretzat hain kezkagarri
Baldin badago ezin guk kendu
ez badago ezin jarri
baina egia balitz nahi nuke
zure aurrean itzarri
betikotasun osoa eman
dezagun beha elkarri